JARRAI KASen barnean gazteen mugimendurako erakunde edo organizazio iraultzaile bezala antolatzen eta eratzen da; gazteon arazoak, era guztietakoak, lantzea hartzen duelarik bere gain.

Blokeko kide denez, militantzi egitura zorrotza beharko du eraman, barne-kohexio eta homogeneizazio trinko batekin, eta iharduera frakzionarioak eta barne-tendentziak onartzen ez direlarik.

Halaber, Blokearen barnean emakumeen organizazio baten beharra ikusten da, emakumearen askapenerako KASeko organizazio iraultzailea bezala egituratuko dena, alegia; eta beste kide guztiak bezala erabateko autonomiaz eta subiraniaz eraikiko dena.

JARRAI, se configura como la organización revolucionaria de KAS para el movimiento juvenil, en las tareas de abordar la problemática de la juventud en todos sus aspectos.

En razón de su pertenencia al Bloque, precisará de una estructura militante estricta, con una fuerte cohesión y homogeneización interna, sin concesiones a actividades fraccionarias ni a tendencias en su seno.

Se ve asímismo la necesidad de una organización de mujeres dentro del Bloque que se configure como la organización revolucionaria de KAS para el movimiento de liberación de la mujer y que al igual que el resto de componentes se establecerá con plena autonomia y soberania.

## 5) KAS BLOKEAREN EGITURATZEA.

KAS Blokearen egituratzea bera osatzen duten organizazio-kide guztien independentzia eta erabateko subirania aitortuz itxuratzen da. Egituratze honetan bere kide diren organizazioen funtsezko lema den oinarrizko demokraziaren printzipioak gida behar ditu egitura bateratuak ere, alderdi burokratikoak ahalik eta gehien baztertuz.

Bloke barneko gidaritzako organu nagusia KAS Nazionala da, organizazio ezberdinetako ordezkariez osatua. Bloke kontzepzioak eta bere organizazio-kideen koherentzia ideologikoak eta politikoak erabakiak guztien adostasunez hartzera bultzatzen dute. KAS Nazionalaren erabakiak baseetara organizazio bakoitzaren egituraren bidez heltzen dira.

KAS Nazionalean hartu diren erabaki baterakor eta globalak betetzeko eta funtzionalki desarroilatzeko bi organu delegatu edo ordezkari eta haren aginduen betetzaile soil-soilak direnak eratzen dira: KAS teknikoa, nazio-mailako koordinazioa duena, eta lekuko KAS, auzo, herri edo eskualde-mailako koordinazioa eramaten duena. Lehenengoa organizazio bakoitzeko nazio-mailako militanteez osaturik egongo da; eta bigarrena, berriz, auzo, herri edo eskualde-mailako organizazio bakoitzeko militante guztiek edo batzuk (baldintzen arabera) osatuko dute.

## *5) ESTRUCTURACION DEL BLOQUE KAS*

La estructuración del Bloque KAS parte del reconocimiento de la separación y plena soberania de las organizaciones y de su carácter igualitario. Esta estructuración debe propiciar que el mismo principio de democracia de base que inspira sus organizaciones miembros, inspire asímismo las estructuras unitarias, limitando los aspectos burocráticos a la mínima dimensión precisa.

El órgano máximo de dirección dentro del Bloque lo constituye el KAS Nacional, compuesto por delegados de las diferentes organizaciones. La concepción del Bloque, la coherencia ideológica y política de sus organizaciones miembros, llevan a que la fórmula de decisión sea por mútuo acuerdo. Las decisiones de KAS Nacional se transmiten y fluyen a las bases a través de la estructura de cada organización respectiva.

Para la ejecución y desarrollo funcional de las decisiones globales y unitarias adoptadas en el KAS Nacional se constituyen dos órganos delegados y meros ejecutores del mismo: El KAS técnico, con rango coordinador a escala nacional y el KAS local, con rango coordinador a escala de barrio, pueblo o zona. La composición del primero constará de militantes representativos de cada una de las organizaciones a nivel nacional, en tanto la composición del segundo, constará de la totalidad (o parcialidad dependiendo de las condiciones) de los militantes de cada una de las organizaciones a nivel de barrio, pueblo o zona.

# LINEA POLITIKOARI BURUZKO TXOSTENA

# PONENCIA DE LINEA POLITICA

*LINEA POLITIKOARI BURUZKO TXOSTENA*

*H.A.S.I.REN II. BILTZARRE NAGUSIA*

**AURKIBIDEA:**

## I) KONTSIDERAZIO OROKORRAK.

Prozesu iraultzailea aurrera eramateko bideak bilatzea eginkizun inolaz bazterrezina da organizazio iraultzaileentzat.

Gure kasuan, gure linea politikoa Euskal Herri Langileak bere askatasuna lortzeko aurrera daraman borroka osoaren ondorio da. Borroka honen emaitza ezker abertzalearen jaiotza da, berau organizazio gisa ETAn antolatzea, honen historia, bere organizazio-mailako debateak; hitz batetan, KAS eta HB erakundeei sorrera eman dien dinamika osoa da borroka honen fruitu.

Gure prozesuaren oinarrizko ildoak historiak markatzen ditu, eta denbora, sakrifizio, odol eta saiatze iraultzaile asko eta asko kosta izan da hori lortzea; zeren eta linea politiko zuzena borrokan lortzen bait da, nola borroka ideologikoan, hala politikoan edota militarrean. Hots, linea politikoa ez da zuzena bihurtzen pentsatzen, esaten edota idazten denagatik bakarrik, baizik eta, batez ere, praktikan jasotzen da, hor lantzen eta berriro praktika bihurtzen.

Borroka-urte guztiotan oinarrituz, eta batez ere ETAren sorreraz eta KAS Bloke Gidariari buruzko erabakietan konkretatzen den gure Lehenengo Biltzarre Nagusiko erabakien ondoriozko praktikaz gerozko borrokan oinarrituz, aurrera dakusagun aldi honetarako gure linea politikoa eztabaidatu eta landu beharrean aurkitzen gara.

Ez gara, lehentxoago esan bezala, zerotik hasten; zeren eta geure atzean gure herriak estatu sozialista, independente, birbatu eta euskalduna lortzeko beronen sektore zabalek eraman duten borroka koherente, jator eta etengabekoa bait daukagu.

Baina abangoardia iraultzailearen egitekoa, nola alderdiarena, hala prozesu honen gidari diren beste organizazio guztiena, gizarte-errealitatea uneoro aztertzea izan behar du eta linea politikoa zuzentzea; honela, langile-klaseko eta herriko sektore ezberdinetan borroka hedatzeko eta sakontzeko, aldi berean, Bloke iraultzailearen sendotzea bultzatzen delarik.

Linea politikoa independentzia eta sozialismoa lortzeko, prozesu iraultzailea aurrera eramateko alternatiba politikoak eskaintzea da; eta prozesu honetan zenbait etapa ezberdin bereiz daiteke, nola boterea hartzeko, hala gizarte komunista lortzeko. Honela beraz, gure bidean helburu estrategikoak eta hauek lortzeko etapak, zeintzu taktikoak deituko bait ditugu, bereizi behar ditugu.

Bai batzuek eta bai besteak gure Printzipio Ideologikoetan jasotzen ditugu, zeintzu, detailetxo batzu salbu, gure ideologiaren definitzaile bait dira, eta oraindik indarrean jarraitzen dute. Ez dago, beraz, Biltzarre Nagusi honetan gure ideologia osoari buruzko eztabaidan sartu beharrik; hala eta guztiz ere, oso kontutan edukiko dugu berau. Prozesu honetan zehar zenbait desbideratze ezagutu izan dugu, helburu estrategikoak ahazteak sorrarazten duen desbideratzioa; eta honela jokatu dutenak erreformismoan erori dira, ideologia iraultzailea gero eta murritzagoa bihurtarazten zuten taktikak jarraitzera jo dute, eta ondorioz, nazio-askatasunerako gure prozesu honetan inolaz bazterrezin diren borroka-motak alde batera utzi dituzte.

Prozesuaren etapa honetan, oinarri hauetatik abiatuz, KAS alternatiba lortzeari buruzko auzian finkatuko gara.

Bestalde, argi eta garbi eduki behar da gure linea politikoaren ziurtasuna ez digula langile-multzo haundi batek bere baietza eta babesa eskeintze soilak ematen; esaten dugunaren froga bistan dago: aukera erreformistek ere herritar sail haundiak erakartzen dituzte beren atzetik. Gure linea politikoaren zuzentasunaren froga, herriaren baiezkoa zabala izanik, prozesu iraultzailea aurrera eramateko garantia edo bermea izateandatza. Hemen aurkitzen da abangoardia garen aldetik gure Linea Politikoa lantzean daukagun erantzukizuna; zeren eta hau gidaritza politikoaren alde funtsezkoa bait da, eta abangoardia horretako organizazioekiko harreman estu-estuan aurkitu behar du, eta baitere, herriaren eta langile-klasearen barnean egiten dugun lanarekin eta dugun eraginarekin.

Beste kontsiderazio orokorra zera litzateke: linea politikoaren analisia egiterakoan, oso kontutan izan behar da baldintza edo kondizio objetiboen eta kondizio subjetiboen arteko lotura eta erlazioa. Akats izugarria litzateke linea politikoa bene-benetako baldintzak kontutan izan gabe lantzea; baina kontutan izan behar da baldintza hauek, halaber, borrokaren bidez lortzen direla; eta honela ez dugu erreformismoaren beste akats historiko nagusian erori behar, hots, kondiziorik ez dagoela esan eta burgesiak markatzen duen gidaritzara makurtu, alegia. Kondizio objetiboen eta subjetiboen analisi iraultzailea egiteak ez du hauek onartu egiten ditugunik esan nahi, baizik eta, diren bezala aitortuz, geure ikuspegitik aldatzen saiatu behar dugu; besterik egitea erreformismoaren ohizko akatsean erortzea litzateke, edota ezkerkerian erortzea, baldin eta baldintza hauek eragineremutzat aitortzen ez badira.

Gure egitekoa langile eta herritar borroka gidatzea da, inoiz ez ordezkatzea burgesiak beregana ezinezko zentzua emanez; politika-alorreko haserreari zentzua ematea, lotan dautzan kontzientziak iratzartzea; burgesiaren eta beronen morroien maliobrak eta joko zikinak desmaskaratzea. Honela izango gara abangoardia iraultzaileak izan behar duen erreferentzi puntua, langileek sentitzen dutena jasoz, herritar sentimendua jaso

ahal izateko sena desarroilatuz, landuz eta kontzientzia argi eran hedatuz, herriak bere kontzientzia eta praktika iraultzaileak gehitu ahal ditzan. Honi deritza baldintza objetiboak eta subjetiboak kontutan edukitzea, eta ez korronte erreformistek egiten duten bezala, zeintzu burgesiarekin paktatuz, langile-klasea desmugi eraztera eta desarmatzera jotzen bait dute, eta sektorerik atzeratuenen eta burgesiak bereganatuen funtziotako politika eramaten.

Carrero Blanco, Francoren ondorengotzat aurrikusiriko elementu bakarra, exekutatua izan zenean, inperialismoak, oligarkiako eta ejerzitoko frakzio ezberdinek, zeintzu Espainiako Estatuan botere-hegemonia bait zuten, Estatuko Ekonomiaren eta politikaren hegemonia edukitzeko formula politiko hau berrikusi eta birraztertu beharrean aurkitu ziren.

Honela, "irekitzea", eta geroago "erreforma" haustura demokratikoaren kontrajartze gisa azaldu ziren. Terminoon arteko desberdintasuna funtsezkoa da Espainiako Estatuko egungo egoera politikoa ulertu ahal izateko, eta baitere, KAS alternatibak gaur egun duen zentzua eta edukina ulertzeko.

Erreforma industri burgesiako sektore indartsuek bultzaturiko maliobra politiko bezala jaio zen; honela, borroka antifrankista eta nazio-askatasunerako borrokak, batez ere Euskadin desarroilatzen ari zena, eta egunetik egunera indar haundiagoa hartzen zihoana, neutraltzeko.

Nahiz eta oligarkiako eta ejerzitoko sektorerik gogorrenek gogo haundirik gabe onartu, burgesiak bere klase-dominazioa betikotzeko-formak berritzeko projektua babestu eta bultzatu zuen. Kapitalaren irabazi-tasak ahalik eta kostu sozial txikiena jasanez edukitzea arrazoi ederra zen, eta are gehiago, iadanik Estatuan sentitzen hasia zegoen nazioarteko ekonomi krisia kontutan hartuz gero, zeren eta krisi honek Estatu osoko gizarte-borrokak eta gatazkak ugaldu egin bait zitzakeen, burgesiarentzat arrisku larriak sorraraziz.

Prozesu honen gure ikuspegitik azpimarratzeko ezaugarririk funtsezkoena jarraiko hauxe da: Aldaketa politiko hau Estatuko herrietako borrokak ugaltzearen ondorio bada ere, epe oso-osoan burgesiak berak eramaten du iniziatiba guztia; eta honela, honen ondorioz, nahiz eta zenbait askatasun formal lortu, hauek ez dute, inolaz ere, Estatuko herrien askatasun-bidean benetako aurrerapenik adierazten, aitzitik baino, beren borrokarako atzerapen eta oztopo besterik ez dira. Hemen kokatzen da Espainiako alderdi eurokomunistaren eta II. Nazioartekoaren espainiar ordezkari den PSOEren traizio historikoa; zeintzu ez bait dira Euskal Herriaren nazio-askatasunerako borroka ez ulertzeko eta, ondorioz, ez babesteko akats historikora mugatu, baizik eta Espainiako herriaren eta langile-klasearen interes objetiboak ere traizionatu egin bait dituzte. Halaber, aipatzekoak dira euskal burgesiaren, PNVn adierazten denaren traizioa, eta euskal errebisionismoaren, EIA eta PMn agertzen denarena; zeintzu aurrerago aztertuko bait ditugu.

Hau Hego-Euskadiko eta mundu osoko iraultzaileontzat ikaskizun historikoa dugu: hilzorian dagoen erregimena ez dela berez bakarrik erortzen erakutsi digu; aldaketa sozialaren oinarri objetiboa produkzio-indarren desarroiloa izanik ere, erlazio sozial berriak ez direla automatikoki sortzen, alegia. Hilzorian dagoen erregimena ez da berez desagertzen, baizik eta hankaz gora bota egin behar da eta desegin. Hementxe datza, hain zuzen, zein klase sozialek hegemoniatzen duen prozesuaren garrantzia, abangoardia organizatuaren garrantzia eta aliantza-politikaren garrantzia.

Textuinguru honetan, erreforma-prozesuak edozein prozesu iraultzailetan garaipena lortzeko garrantzirik haundiena duten hiru faktore edo elementu nabarmen erazi ditu. Hiru faktoreok segidan eztertuko ditugu:

a) Abangoardiaren arazoa.
b) Faktore subjetiboak.
c) Herriaren batasunaren arazoak.

## 1) ABANGOARDIAREN ARAZOAK.

Erreforma, orohar, Espainiako Estatuan eta burgesiaren ikuspegitik nahiko ondo atera zela esan badezakegu ere, Hego-Euskadin funtsezko oztopoa aurkitu duela aitortu behar du, zeren eta Herriaren sektore garrantzitsu batek, KAS buru zela, prozesu hau bere sorrera bertatik salatu eta arbuiatu egin bait zuen, zituen edukin eta formengatik.

Bloke gidariaren erabaki garrantzitsu hura, zeinaren ondorioak gaur egungo indarren erlazioaren argitara azter bait ditzakegu, euskal prozesu iraultzailearen bene-benetako abangoardia gisa itxuratzeko pauso txit garrantzitsu gertatu zen; aldi berean, aukera erreformistak desmaskaratzen zituelarik, zeintzu, denbora pasa ahala eta erreformaren gainbehera gero eta haundiagoa delarik, argi eta garbi frogatu bait dute bere izaera buru-makurtzailea.

Igaro diren urte hauek praktikan KASek askatasun-prozesuari egin ekarpenik haundienetakoa, hau da, prozesu horretan ematen diren borroka-mota ezberdinen arteko erlazioen zuzentasuna eta beharra nabarmendu digute. Errealitate hau, Alderdia bere Lehenengo Batzarre Nagusian ikusteko eta teorizatzeko gauza izan zena, ideologi trinkotasuna eta organizazio-heldutasuna lortzen joan da; eta horregatik, bere kontzepzio teoriko-praktikoari dagokionez salto koalitatibo berria behar-beharrezkoa denez, gai hau txosten berezian aztertzen dugu.

Aurreko guzti honen ondorioz, ezker abertzale iraultzaileko masen irmotasuna, gehitze koantitatibo garrantzitsua bakarrik ez ezik, zentzu guztietan trinkotu eta sendotu egin da (eta honek du garrantziarik haundiena), Euskal Herri Langileak nazio-askatasunerako prozesuan hegemonia nabarmen-nabarmena hartuz. Eta errealitate hau gaur egun gertakari kontsumatua da. Horregatik, nazio-askatasunerako borrokak gaur egun iadanik edukin iraultzaile garbi-garbia du.

2) FAKTORE SUBJETIBOAK.

Hego-Euskadin Erreformak porrot egin duela azpimarratzen dugun aldi berean, baitere gure prozesuan zer nolako eragina izan duen kontutan hartu behar dugu, eta batez ere zenbait langile eta herri-sektoreen egoera subjetiboan.

Nahiz eta KAS, erreformaren hasera haseratik, Euskal Herriarentzat erreforma honek zer nolako zentzua zuen salatzen aritu, herritar sektore haundiek diktadorea desagertzean askatasun formalak lortuko zirela eta hauen bidez autogobernu, burujabetza eta askatasun-maila haundiak eta garrantzitsuak lortu ahal izango zirelako itsaropen izugarria agertu zuten. Ilusio faltsu hauek sorrarazten funtsezko eragina eduki zuten, nola ez, oligarkiaren eta ejerzitoaren ordezkari politikoekin jokoan sartzea onartu zuten alderdi eta taldeek.

Sektore benetan garrantzitsuetan hedatu ahal izan ziren ilusio hauek, urte gutxi batzu pasa ondoren, zeharo desberdina den errealitatearekin aurrez-aurre jarri beharrean aurkitu dira.

Zenbait alderdi eta sindikatuen traizioak eta utzikeriak etsipenak eta desengainuak sorrarazi ditu, eta hauek zuzenki gainditzeko, hau da, erreforma zer nolakoa izango zenari buruzko hasera-haserako akatsak aitortzeko, zailtasun haundiekin aurkitzen dira, zeren eta, nahiz eta etsipenetik eta erreformari buruzko desengainutik borroka eta organizazio-jarrera eta aukera zuzena nahitaezkoa behar-beharrezkoa delaren kontzientzia argi eta garbia atera badaiteke ere, halaber egia da jarrera teorizista eta bakarkako eskapismoetan erortzeko arriskua ere badagoela.

Bestalde, bigarren faktore subjetiboa, aurrekoa bezala hau ere ezkorra, kontzientzia txikiko edo batere gabeko zenbait sektoreek daukaten edo eduki dezaketen beldurra da. Estatuaren aparatu errepresiboetatik egiten den errepresioaren beldurra, alegia; eta baitere ekonomi errepresioa, egungo krisi ekonomiko gero eta bizkorragoaren ondorio dena, alokairuak murriztuz edota izoztuz, enplegu-erregulazioak, despiduak, langabezia etab. etab. . . Honela, klase dominatzaileak, errepresio-mota hau sortuz eta hedatuz, prozesu iraultzaile oro ito nahi du, masak desmugiaraziz eta abangoardietatik aldenduz. Aitzitik, beldurra, arrazoizko faktore dena, era zuzenean gaindituririk, hau da, ez bakarka, baizik eta kolektiboki, kontzientzi maila haunditzearen, eta ondorioz, organizatzearen eragile gertatzen da.

Azkenik, zenbait sektoretako konfusionismoa, Estatuaren aparatu ideologiko ezberdinek –komunikabideek, Elizak, alderdi erreformistek.....– egiten duten intoxikazio-lanaren ondorioz sortutakoa, dugu eragin ezkorra duen hirugarren faktore subjetiboa, honek ere ondorio desmugiarazleak sortzen dituenez; eta borroka ideologikorako bide gerta daitezkeen propaganda-lanen desarroiloaren bidez erantzun egokia jaso behar duena.

Faktore subjetibo ezkor edo negatibo hauen eta beste batzuen eraginari kontra egiteko, behar-beharrezkoa da erreformismoa desmaskaratuko duen borroka ideologikoa bultzatzea, beldurra gainditzen lagunduko duena, eta langile-klasearen eta herriaren barnean kontzientzia ugaltze orokorra eta argiagoa edukitzea bultzatuko duena; honela, berau organizatzen lagunduz eta ahalbidetuz, eta ondorioz, faktore subjetibo ezkor hauei aurka egiteko gaitasun haundiagoa edukiz.

3) HERRIAREN BATASUNAREN ARAZOAK.

Erreforma politikoa burgesia nazionalistako partidu edo alderdien eta espainiar ezkerreko eta euskal ezkerreko deitzen diren batzuen hutsegitearen, utzikeriaren edota traizioaren ondorio da. Aurrekin hauekin, badirudi oso gaitza dela arazo honi heltzea; baina, gure herriaren garaipenean behar-beharrezko elementua eta garrantziarik haundienekoa dugu berau.

Izan ere, hain zuzen, batasunerako borroka, euskal prozesu iraultzailearen desarroi-

lo zuzena bermatuko eta garrantizatuko duten elementu ideologiko eta organizaziozkoak inolaz ere ez baztertzean oinarritzen dena, konstante bat izan behar du Blokearen, Herri-Batasunaren, masa organizazioen, . . . barnean. Honela bakar-bakarrik da posible alde honetatik erreformak kausitu dituen akatsak eta hutsuneak gainditzen joateko prozesuan aurrera egitea. Amnistiaren Aldeko, Lemoizen aurkako, Euskararen aldeko mobilizazioetan, Herri Batasunaren sorreran eta desarroiloan markatu bidetik jarraituz. . .

Batasunaren arazoa eta beharra azpimarratzen baldin badugu gure herriaren askatasunerako bide honetan egin behar dugun lanak arrakasta egokia izan dezan funtsezko garrantzia duelako da. Izan ere, gaur egun sartuta aurkitzen garen prozesu honetan funtsezkoa da Estatu zapaltzailearen kontra jaikitzeko gure gaitasun kolektiboa gehitzea; eta hau Euskal Herriko gehiengoa bere interes objetiboen aldeko borrokan bilduz, hots herri-mailan indarrak bilduz eta pilatuz, eta etsaiari kenduz bakar-bakarrik lor dezakegu.

Masa zapaldu eta oinperatuen batasuna lortzea ez da, inolaz ere, lan erraza. Nola abangoardiaren ezintasun ideologiko eta organizaziozkoak, hala izaera ezkorrezko faktore subjetiboen presentzia hura lortzeko eragozpen funtsezko gertatzen direnez. Horregatik, maila guztietako borrokaren desarroiloak eta aurrerapenak bakarrik ireki diezaguke langile-klasearen eta herriaren kontzientzia argitzeko eta sakontzeko bidea, honen batasun ideologikoa, politikoa eta iharduerakoa, eta bere organizatzea lortzeko bidea. Lan iraunkor, jator, saiatu eta ideologikoki landu baten bidez bakarrik gaindi daitezke alde ezkor edo negatiboak, baikor edo positibo bihurtuz, eta neurri eta maila guztietako ezintasun eta ahultasunak gainditu, abangoardiaren gaitasuna gehitu eta masen batasuna beren askatasunerako borrokan zabaldu.

## II) ERREFORMA—PROZESUA: ESPAINIAKO BOTERE BURGESAK ERABILI MEKANISMOAK.

1) Espainiako Estatuko erreforma-prozesua, bertan forma demokratiko burgesak finkatzea bilatzen duena, bere barneko izaeragatik eta hasten, gertatzen eta desarroilatzen deneko baldintzengatik, erabat kontraizankorra da, eta honegatik, bere helburuak eta xedeak betetzera heltzea inolaz ere ezinezkoa zaio. Baina baieztapen hau egitera bultzatzen gaituzten arrazoiak labur-labur azaltzeaz aparte, hori baino garrantzitsuagoa dela uste dugu, gure Linea Politikoa definitzeko textuinguru honetan, espainiar burgesia bere projektu politikoa inposatzeko baliatu den mekanismoetaz azterketa egitea.

Carrero Blanco Almirantea exekutatzeak diktadura militarreko erregimen frankista momentu batez jarraipenik gabe utzi zuen, gainera,diktadura garbiko sistema hau fisikoki akitzen ari zen une berean. Francoren diktadura garaian bloke dominatzailearen barneko hegemonia argi eta garbi espainiar oligarkia finantzari eta lur-jabearen esku zegoen, eta honek bere nagusi-izaera ahalik eta gehien explotatu zuen bere sorrera-sorreratik 1936ko uztailaren 18ko altxamendua aurrera eraman eta Gerrate Zibilean garaile atera zen ejerzitoko sektorearekin estu-estu bat egina aurkitzen zenez gero.

Oligarki zati hau, botere bortxazkoan eta zahartze mental eta fisikoan desegina, diktadura frankistari jarraipena eman ahal izateko ideiarik gabe geratu zen. Hauxe izan zen, hain zuzen, beste frakzio burges batek itxoiten zuen unea, industri eta merkatal burgesia monopolistak alegia, bere projektu politikoa aurrera atera ahal izateko, eta, azken finean, botereko blokearen barnean hegemonia lortzeko. Projektu politiko hau zera zen: bere kanpo-itxuragatik eta barneko egituragatik nazioarteko burgesiaren menpean zegoen espainiar burgesiako frakzioaren interesentzat inperialismoaren katean sartzea behar-beharrezko eta nahitaezko zen egoera lortzea eragozten zuen diktadura militarreko egoera Europako mendebaleko demokrazien sailean homologatzeko modukoak izan zitezkeen itxura demokratiko-burgesen bidez estaltzea, alegia. Erregeak projektu politiko hau babestu egiten zuen, eta beronen mekanismotako bat bilakatzen, eta oligarkia finantzari eta lur-jabeak, gorago esan den bezala, ez zuen gehiegi eragozten projektu hau aurrera eramatea. Bi frakzioon artean interes konpartituak nagusi dira eta oligarkia finantzariak, betiere, berekin ditu industri burgesia bere menpe jarrarazteko edota itzularazteko baliabideak, azken finean, armadaren eskuhartzea bortxatuz haserako puntura itzuli nahi balitz.

Baina, zeintzu ziren erreforma politiko honek aurkitzen zituen eragozpen eta oztopo nagusiak?

Lehenik, langile-masen eta herritar masen borroken gorakada, Estatu barnean iraultza herritarraren prozesuan bihur zitekeena, edota, gutxienik, projektu demokratiko-burges aurreratu batetan, diktadura militar garbiaren erabateko akitzeari eskaini alternatiba bezala.

Bigarrenik, nazio zapalduetako borroken, eta batez ere Hego-Euskadiko nazio eta klase-askatasunerako prozesuaren hedatzea eta sakontzea.

Hauek ziren erronka edo arazo nagusiak, eta hauen aurka erregimen frankista garbian kokatu eta kateatu frakzio oligarkikoak ez zuen inolako erantzunik. Azkar aguro ikusi zen, bere alternatiba, Arias Navarroren irekitze politikoa deitua, ez zela politika-aldetik irtenbiderik zuen ezer. Garbiketa sakonagoa behar zen, ordurartekoa gutxiegi zen.

Industri burgesiaren iniziatiba politikoa, erreforma politikoaren projektua deitua, ardatz eta molde ausartagoen gainean mugitzen zen.

Lehenik, forma demokratiko-burgesen instituzionalizatzea konstituzio batetan oinarrituz eta botere politikoentzat estruktura eta erlazio demokratikoak eta herriarentzat askatasun demokratikoak eskaintzea.

Bigarrenik, langile-klasearen organizazioen barnean erreformismoa ereitea eta sustatzea, masa-borroka galgatzeko eta ezabatzeko.

Hirugarrenik, Autonomien Estatutua eraikitzea, nazio-erreibindikazioak desbideratu eta zokoratzeko, eta batez ere, euskal nazio eta klase-askatasunerako prozesua.

Gure iharduera politikoaren eremu honetara bilduz, hirugarren ardatz hau aztertuko dugu, zeina, gainera, lehenengo beste biak erabiltzeaz elikatzen bait da; baina Hego-Euskadin agertzen duen funtzionaltasun berezi-berezira mugatuko gara.

2) Kontutan izan beharreko lehen egitatea euskal burgesiak, desegokiro batzutan nazionalista deitzen denak, espainiar estatuko prozesu erreformatzailean aktiboki kolaboratu duela eta bere egin du, honek esan nahi duen guztiarekin eta beronen ondorio guztiekin. Zenbait baztertze-itxura, hala nola Konstituzioaren Erreferendunean abstentzioa proposatzea, horixe besterik ez da izan, itxurakeria, irudi jator bati eutsi nahi izatea, batez ere, bere alderdi historikoaren bidez eta euskal herriaren ezezkoa nabarmen-nabarmena zeneko unean izaera populistako manipulaziorako. Euskal burgesia aspaldidanik jarrera desnazionalistan aurkitzen da, hau da, espainiar burgesiaren eta nazioarteko burgesia inperialistaren menpean dago, hauekin oinarrizko interes bateratzaileak dituelarik. Euskal nazio eta klase-askatasunerako mugimenduaren sorrera eta desarroiloarekin projektu nazionalista ororen azken kondarrak bazterrean utzi beharrean aurkitu zen behinbetirako, zeren eta, berak inolaz ere gidatu ezin duenez, bere klase-interesetarako mesedegarri gertatzea ezinezkoa bait da, aitzitik baizik, sustrai-sustraitik zeharo kaltegarri. Interes hauek izan dira, beraz, nazio-mailako benetako estrategia baztertzera eraman dutenak, eta honen lehen adierazpen argi eta garbia Nafarroa kanpoan utzizko autonomi projektua onartzea izan zen, zeina euskal nazio eta klase-askatasunerako borroka zatitzeko eta neutraltzeko lehen pausoa baino ez bait zen.

Guzti honengatik, Hego-Euskadiko Erreforma, Baskongadak eta Nafarroa erakunde-mailan zatitzeko prozesuan oinarritzen dena, horretarako Estatutuaz eta Foruaren Hobekuntzaz baliatuz, eta Estatuko botereekiko erabateko menpekotasunaren gainera, ez dago inolako autogobernu edo burujabetzara zuzendua; baizik eta alderantziz, estatu-aparatu hurbilagokoak gainjartzera zuzendua dago, besterik ez, honela gizarte-kontrol zorrotzagoa eta efektiboagoa ezarri ahal izateko, burgesiak langile-klasearen kontra nahitaezko dituen ekonomi birrantolaketako egitasmoak aurrera eraman ahal izateko, eta azken finean eta batez ere, martxan aurkitzen den euskal prozesu iraultzaile honen aurka hurbil-hurbiletik eta barrendik borroka egin ahal izateko. Borroka hau ez dute Estatuari gainjarritako errepresio-aparatuen iharduketa zuzenaren bidez bakarrik egiten, baizik eta baitere, posibilismoaren eta mailaketa edo gradualismoaren eskaintza ameskorren bidez, zinez faltsua eta inork nahi ez duena den gradualismo eta posibilismoaren bidez, herriko eta langile-klaseko sektore kontzientziarik gabeak eta erreformistak nazio eta klase-askatasunerako iadanik hasita dagoen bidetik aldendu asmoz.

3) Zentzu honetan, Hego-Euskadiko erreformaren mekanismoa zen, Estatuan bezala, baina hemen zentzu eta eragin aski haundiagoz, ahalmen eta indar guztiz nazio-askatasunerako borrokan era batera edo bestera, neurri haundiagoan edo txikiagoan eta konpromiso eta kontzientzi maila haundiagoz edo txikiagoz integratua aurkitzen ziren sektore abertzaleetan sozialdemokrazia eta erreformismoa sorraraztea eta indartzea. Euskal sozialdemokrazia abertzaleak ez zuen iraupen luzerik izan, haserako desarroilorako kondiziorik ez zuenez. Kontutan izan behar da, gaur egun Europa-mailan ikusten dugun sozialdemokrazia modernoa, marxismoa ukatu duena, sozialdemokrazia klasiko marxistaren (sasimarxistaren, baina forma-aldetik bederen marxismo-motako analisitara jotzen duenaren) ume eta oinorde dela, mende honen haseratako sozialdemokrazia erreformistaren jarraitzaile. Horregatik, Hego-Euskadin erreformismoa eman behar zen aurretik.

Teoriaren eta praktikaren arteko harreman eta erlazio dialektikoak ez dira linealak eta arruntak edo soilak, aski konplexuak baizik. Teorizazio oker batek, hau da, errealitate konkretuaren baldintza objetiboen eta subjetiboen praktikaren abstrakzio txar ba-

tek, ondorioz, praktika oker batetara eraman gaitzake, eta eraman ere eraman ohi du. Eta behin praktika oker bat hartuz gero kasik ezinezkoa da teorizazioa ere bide zuzenetik joatea. Bestalde, teorizazio-prozezua errealitateko sektore guztietan, eta ondorioz, baitere langile-klasearen eta honen abangoardien barnean sartzen den burgesia dominatzailearen ideologiaren eraginpean egiten da. Zentzu honetan ulertu behar da klase-organizazioen barnean desbideratze erreformisten jaiotzearen eta burutzearen arrazoia.

Orain, atal honetan, ez dagokigu Hego-Euskadin erreformismoa sortzearen eta hedatzearen hurbileko eta urrutiko arrazoiak banan-banan ematea; baina erreformismo hau argitzen duten zenbait oinarrizko linea emango ditugu.

Arrazoi nagusia Hego-Euskadiko errealitate konkretuari buruzko abstrakzio edo teorizazio okerra egitean datza, eta halaber, estatu-mailako erreforma-prozesuaren teorizazio okerrean, jatorrizko analisi marxistaren bidea baztertzetik eratortzen dena, burgesiaren menpean aurkitzen den mundu osoko langile-klasearen praktika historiko benetan iraultzailearen ondorio den analisia marxista abandonatzetik, alegia.

Hego-Euskadin erreformismoa, beste lekuetan bezala, zenbait axiomatan oinarritzen da. Axioma hauek honela labur ditzakegu:

- Gizarte industrialdutako Estatu burgesaren aparatuek, eta hau da Euskadiren egoera, halako indarra eta desarroiloa dute ze beraiei aurrez-aurre erasotzea suizidioa bait litzateke.
- Estatuaren eta gizarte zibilaren arteko harremanak eta loturak erabat konplexuak eta estuak dira eta burgesiaren hegemonia bi alorrotan ematen da. Honela, ideologia dominatzailearen eragina erabatekoa da eta herriko eta langile-klaseko sektore guzti-guztietan sartzen da.
- Ondorioz, gizarte industrialdu hauetako langile-klasea erreformista da eta bere praktikak ez ditu batbateko erreibindikazio ekonomikoak besterik bilatzen.

Axioma hauek, goi-mailako abstrakzio edo globalitate baten ondorio direnak, estrategia politiko konkretuago beste axioma, ondorio eta definizio batzuekin lotzen dira:

– Ez Espainiako Estatuan eta ez Hego-Euskadin ez da posible haustura politikoa.

– Krisi ekonomikoa, nahiz eta oso larria izan, egungo espainiar eta euskal kapitalismoaren desarroiloan, ezin daiteke bertatik burgesia galtzaile ateratzeko moduko krisi historikoa izan.

– Estatu-markoak, bertako klase-borrokaren eta borroka politikoaren mailak era determinatzailez baldintzapetzen ditu euskal herri-mailako borroka politikoaren ahalbideak.

– Kapitalismo aurreratuko langile-klaseak, eta noski, euskal langile-klaseak, burgesiaren ideologiaz betea dagoena, ezin du inolaz ere egoera iraultzaile egokirik sorrarazi.

– Ondorioz, beraz, homogeneizazioa behar da: iharduketa politikoa langile-klasearen egungo dinamika erreformistara egokitu, frenatu egin behar dira, beraz, jokabide eta jokaera radikal suizidak; Hego-Euskadiko langile eta herritar borroken prozesuen a abiadura erritmo mantsoago eta forma gidatuago eta instituzionalizatuagotara moldatu eta egokitu.

– Ondorioz, beraz, gradualismoa nahitaezkoa da: gizarte zibilaren eta estatuaren aparatu ekonomikoen arteko erlazioetan sartu, izaera autonomikoa duten Estatu-aparatu eta erakundeetan sartu, askatasun demokratikoen desarroiloan barnetik sartzen ahalegindu, eta poliki-poliki eta mantso-mantso gizarte burges eta sistema kapitalista honen barnean langile-klasearen nagusigoa eta hegemonia ezartzen saiatu. Teoriz, hegemonia honek ahalbidetuko du gizarte eta sistema honen geroko aldaketa.

Errealitateak, praktikak epe aski laburrean erakutsi eta frogatu digu Hego-Euskadin ez baldintza objetiboek ez subjetiboek ez diotela analisi honi erantzuten eta herrien eta langile-klasearen askatasuna burges dominazioaren aurrean lortzeko bidea historian zehar eman den bakarra dela. Baina baiezpen soil honetan geratzeko, ondorio batzuk arrazoitu behar ditugu gure ikuspegi historikotik erreformismoaren aurrez-aurre.

Orain arteko guzti honetatik zera atera dezakegu: Hego-Euskadiko erreformismoaren bene-benetako sustraia euskal nazio-estrategia abandonatzean datzala, honek klase-borrokaren gure markoan kontraizan nagusia areagotzeko eragina bazterrera uztea adierazten bait du. Gure prozesu iraultzailea eta beronen borroka-motak sakontzetik aldentzen dena, gure nazio-askatasuna lortzera zuzendurik dagoen prozesu iraultzailea abandonatzen duena erreformismoan erortzen da nahitaez, eta egia hau gure prozesuaren historiak berak frogatzen du argiro. Egungo egoeran, gaurko epe honetan, nazio-estrategia abandonatzeak erreforma politikoa onartzea ekarri du ondorioz, zeinaren lehen zuhin nagusia eta determinatzailea, euskal burgesiarentzat bezala, erregimen preautonomikoa onartzea izan bait zen.

Bestalde, erreforma onartzeak ez du esan nahi nazio-estrategia abandonatzea bakarrik, baizik eta gorago aipatu ditugun axioma erreformista horiekiko halako jarrera ideologiko eta teoriko bateratsua ere adierazten du; bestela ez bait zen gertatuko erreforma hau, hain zuzen. Ondorioz, guztiz koherentea eta logikoa gertatzen da erakunde-mailako borrokari lehentasuna ematea, eta euskal herri langilearen sektore abertzale iraultzailearen borroka-forma nagusiak ziren masa -borroka eta arma bidezko borroka lehendabizi bigarren mailanjartzea eta ondoren bazterrera uztea aurretik esandako guztiaren ondorio ezinbestekoa da. Honetaz gainera, egitasmo politiko guztiak batbateko erreibindikazioen inguruan bakarrik mugitzea, honela, burgesiaren planei atxekiz, eta azken finean, inperialismoak Euskadiri buruz dituen planei amore emanez, praktikan, gaur egungo eurokomunista deitu erreformismo guztiak bezala, horien aliatu objetiboak bilakatuz eta bihurtuz.

Nahiz eta klase-organizazioak inoiz ere ezin sentitu izan erreformismoarengandik libratzeko moduan txertatuak, KAS Bloke iraultzailea osatzen dugunoi dagokigunez zera aitor dezakegu: praktikan oinarritutako koherentzia eta aurrerapen ideologiko batetara heldu ahal izan dela, eta nazio-askapenerako eta klase-askapenerako borrokak iadanik halako irmotze eta trinkotze maila lortu duela, nahiz eta indarren koerlazioa oraindik erabat geure aldekoa ez izan, ze erreformismoaren arriskuakoso txikiak ditugula. Zeren eta argi asko ikusten bait da borroka legezkoaren ahalbideak erabili beharrezkoak direla, baina betiere legez kanpoko borrokaren pean, hots, burgesiaren legezkotasunaz kanpo, honek gu bere sisteman artzea eta integratzea besterik ez bait du bilatuko, eta bere izatea arriskuan jar dezaketen mugan gainditzen inoiz ez bait du lagako. Guztiz argi eta asumiturikdago, beraz, erakundetako borroka herri-kontraboterea sarrarazteramugatu eta zuzendu behar dela eta masa-borrokaren pean egon. Argi eta garbi ikusten da eta asumitzen biolentzia iraultzailea nahitaezko eta ezinbestezko baldintza dela Estatu burgesa hankaz-gora botatzeko, eta gure kasu konkretuan Espainiako eta Frantziako Estatu erdirakoien aparatu zentral eta autonomikoak ezabatzeko. Eta, azkenik, guztiz argi etaasumiturikdago batbateko erreibindikazioen alorrean ere sartu behar dela, baina orokorrekin lotuz, eta honela, edukin eta zentzu iraultzailea emanez.

4) Bukatzeko, erreformaren analisiari dagokionez eta labur-labur, zera aipatuko dugu: haseran esan den bezala, kontradikzioz betetako prozesu hau ezin zitekeela demokrazia burges baten eraikuntzan eta finkatzean amai; errealitatea hala erakusten ari zaigun bezala; eta hau oinarrizko zenbait arrazoirengatik, zeintzu, KASeko organizazioek izan ezik, espainiar edota euskal indar burges eta langile-klasearenek, den-denek, ahaztu edota gutxietsi egin bait dituzte, hain zuzen.

Analisiko lehen errorea hauxe da: frankotiar diktadura militarreko Estatu-aparatuen egiturazko ezaugarrietan, botere-erlazioei dagokionez, behar bezala ez sakontzea. Analisi zuzen batek kasu honetan, beste antzekoetan bezala, diktadura militarretik oinarri-oinarrizko hausturaren bidez bakar-bakarrik irten daitekeela frogatzen du; oligarki dominazioaren eta nazio-zapalkuntzaren sustraia, gure kasuan gure burujabetza eta herri bezala autodeterminatzea eragozten diguna, eta dominazio honen euskarri diren bide, aparatu eta elementu militarrak ezabatuz bakar-bakarrik, alegia.

Bigarren akatsa zera da: honetaz aparte, burgesia erreformistaren erreforma-projektuak nahitaez porrot egingo duela, sistema kapitalistaren egiturazko krisi-egoera baten barnean desarroilatzen delako, sakontasun haundiko krisiaren barnean, zeinaren ondoriorik nabarmenenak, ondoriorik desestabiligarrienak inperialismoaren katearen mailarik ahulenetan, nola Espainiako Estatuan eta berezi-bereziki Hego-Euskadin, nabarmenduko bait dira. Krisi-textuinguru honetan ez dago projekturik, atzera egitea besterik ez, diktadura militar gero eta nabarmenegora itzultzea, berriro ere oligarkia finantzariaren hegemoniapean, edota bestela aurrera jotzea, diktadura militar erdi-ezkutuko eta erreformatu honekiko benetako haustura eginez.

Hirugarren hutsegitea erreforma projektatzen den unean Hego-Euskadiko nazio-askatasunerako eta klase-askatasunerako prozesuaren sakontasuna behar bezala ez baliotzea izan da. Ez zen pentsatzen erreformaren oposizioa marginalitateko politika baino zerbait gehiago izango zenik. Dominazio ideologikoko mekanismoek, demokraziaren lilurak, ondoko erreformak honekiko oposizio guzti-guztia neutraldu eta poliki-poliki integratu egingo zutela uste zen.

## ERREFORMAREN BIGARREN ETAPA. ETAPA SOZIALDEMOKRATA.

Otsailak 23ko gertaeren ondorioz, Oligarkiak eta armadak Erreformari ezarritako mugak argiago ikusten dira (gogora dezagun Erregeak alderdi politikoen gidariekin izandako bilera). Muga hauen artean, lehenik, "ordena soziala" deituaren berme edo garantia daukagu, gizarte-kontrol zorrotzagoa (gutxi-asko erdi ezkutukoa) besterik ez dena; eta bigarren lekuan, "Autonomien Estatuak" administrazio-deszentralizazio arrunt baten mugak baino gehiago ezin gainditu izatea. 0-23az geroztik Estatu-mailako agintari politiko nagusienen artean hitzarmen isil bat burutzen da: hau da, industri burgesiaren (Erreformaren prozesuari ekin eta desarroilatu zuen indar nagusiena eta orain bere mugen kontzientziaz jabetzen denaren), oligarki finantzari eta lurjabeen frakzio burgesaren (Erreformaren lehen etapan noraezean bezala aurkitu zenaren) eta langile-klasearen ordezkari diren eta prozesuari atxekiak aurkitzen diren indar politiko eta sindikalen arteko hitzarmena, alegia. Hemen dautza Erreformaren bigarren etaparen oinarriak, zeintzu urriaren 28an, PSOEk adierazten duen sozialdemokraziaren hauteskundetako garaipenarekin kanporatuko bait dira.

"Zentruko" aukerak, UCD, Estatuko industri burgesiaren frakzioaren ordezkaririk nabarmenenak iadanik 1980an Erreformaren projektuak eta helburuak aurrera eraman eta finkatzeko gaitasunik ez zeukan, eta horregatik, denen oneritziz, hankaz-gora bota zuten. Burgesiak bazekien, gehienez ere, UCDren porrotaren ondoren, Estatuko gizartebaldintzak kontutan izanik, PSOEk (laster ospatuko ziren hauteskundetako garaile "aurrez iragarriak") gehiengo absolutua ez lortzera jo zezakeela; zeren eta beste edozein indar edo koalizio eskubitarraren garaipena erabat ezinezkotzat jotzen bait zen. PSOEren Erreformaren kontraizanetan kateatua aurkitzen zen alderdi politikoaren garaipena, kojunturalki egokientzat ematen zen 0-23an kanporatu zen diktadura militarraren aurpegia berriro maskaratzeko.

Baina, seguraski, denak harritu zituena zera izan zen, PSOEren Urriaren 28ko garaipen hain haundia. Gertaera honek, eta orain aztertuko ditugun ondorengo gertaerek data honetatik aurrekoari Erreformaren bigarren etapa deitzeko bide ematen digute. Bigarren etapa honek aurrekoarengandik jasotako ezaugarriak ditu, hondoan frankotiar diktadurak jarraitzen duenaren seinale bezala, baina baitere baditu ezaugarri "berri" bereziak. Ezaugarri hauek aztertuko ditugu; eta lehendik jasotakoetatik hasiko gara.

– Hausturarik gabe ez dagoela diktadura militarretik benetako irteerarik aldarrikatzen jarraitzen dugu. Eta zentzu honetan, lehenago esan dugun bezala, PSOE Erreformaren morroin kateatua da, edota gauza berdin-berdina dena, armadaren eta errepresioaparatu guztien morroin. Hau ageri-agerikoa da hondoari dagokionez eta nahiko agerikoa formari dagokionez, eta ez du honetaz gahiegi luzatzeak merezi. 0-23koari buruzko epaiketaren eta Auzitegi Gorenaren epaiaren ondoren sektorerik eskuin-muturrekoenak baztertuak gera eraztea lortu ahal izan da. Baina diktaduraren armadak eta honi loturik dagoen oligarkiak ez dute beren botereari eusteko eta erakusteko sektore muturreko hauen inolako beharrik. Armadaren eta honi loturik aurkitzen diren polizi aparatuen egitura oso-osoa diktadura militar garbiko garaian nagusi ziren balio eta formez erabat kutsatua eta betea aurkitzen bait da. Sektorerik radikalenak Erreformarentzat pisu baino ez ziren; Erreformak itxura demokratikoa behar bait du, eta honegatik baztertuak eta sakrifikatuak izan dira. Halata guztiz ere, Hego-Euskadiko arazoa eta errealitatea ukitzen denean, diktaduraren formak eta ezaugarriak erarik gordinenean kanporatzen dira.

– Krisi ekonomiko honek sistema kapitalistak bera gainditzeko duen ezintasuna nabarmentzen digu. Bistakoak ziren adabakiak; ez bait zegoen pentsatzerik (ezta nahi ere), langile-klasearen baldintza subjetiboak kontutan izanik, produkzioaren organizaziorako alternatiba radikal berriak batbatean sortzea ezinezkoa zenez, porrot-egite kontrolik gabeko eta zalapartatsurik. Baina adabaki guzti hauek ezin dute hondoko egia estali, zeren eta ekonomi indikatzaileek krisiaren sakontasuna ageri-agerian jartzen baitdute (azken urteotan ia-ia ez da egon hazkuntza-tasarik; kapitalaren formazio gordinaren jaistea, lanpostuen galtze garbia eta langabeziaren ugaltze izugarria). Halere, azalean eta itxuraz badirudi burgesiak egoera kontrolatzen duela, batez ere langile-klasearen gaur egungo jarrera konformista begiratzen badugu. Hauxe dugu aztergairik garrantzitsuena. Burgesiak badaki Estatuan eta batez ere Hego-Euskadin krisiaren prozesuak eta honen adierazpenik ezkorrenek aurrera jarraituko dutela.

Sistemarekiko konfidantzarik ez dago eta kapitala beldur da, eta horregatik ez du inbertitzen. PSOEren Gobernuak engainuari laguntzen eta eusten dio, nazionalizaziorik ez dela egingo, krisian aurkitzen diren enpresak berriro pribatu bihurtuko direla etab. . . esanez; berriro pribatu bihurtuko den zera bakarra Banka denean, oligarkiaren

oinarri bait da, eta hori ezin du inolaz ere laga, eta gainera, krisi eta guzti ere, negozio izaten jarraitzen bait du (merkantzia unibertsala bere eskuetan dauka, dirua, eta krisialdi honetan plusbalio guztia bereganatzen ari da, enpresetatik ateraz gastu finantzarien bidetik). Izan ere, enpresa-multzo formalki pribatua sortzen ari da, baina hauen birregituratzea eta mantenimendua fondo publikoen bidez bakarrik egin daiteke. Ez da kapital autoktonorik sortzen, ez egungo enpresetan, ezta ere goren mailako teknologiaren inguruan sortuko liratekeen projektu berrietan arriskatuko denik.

— Ezaugarri "berri" bezala aipagarrientzat zera jo dezakegu: PSOEEstatuko Gobernuaren buru izateak nola kanporantz hala barnerantz eskaintzen duen babes eta itxura demokratikoa. PSOEk, bere tradizio historiko luzeagatik eta bere jarrera garbi-garbi antifrankistagatik, UCDk lortu ezin izan zuen bezalako sinesgarritasuna du, eta noski, APk inoiz lortzerik izango ez duen modukoa. Sinesgarritasun hau erabatekoa da Estatu-mailan, nahiz eta Hego-Euskadin ahulagoa izan, eta honela kontraizanak kanporatzeko posibilitatea egon. Baina egia hau ez dugu inolaz ere gutxietsi behar, eta gure linea politikoan beti begibistan eduki behar dugu. Orain zailagoa egiten da Erreforma Frankismoaren jarraipen bezala aurkeztea; PSOE gobernuan egoteak atzean eta azpian eskutatzen den politika zeharo maskaratu egiten bait du. Eta politika-auzia ez da bide zuzenean egotea bakarrik, baizik eta hori horrela delari buruz besteak kontura eraztea eta komentzitzea ere bai, alegia.

— Beste alde "berri" bat orain eman den itxurazko botere-konzentrazioa da. Udal-hauteskundeen ondoren, PSOEk Espainiako Parlamentuan agintzen du, eta baitere, udal eta autonomi komunitate gehienetan. Egoera honek eta eskuineko indar politikoak aurkitzen diren ahultasunak epe luzeagorako apustuaren tentazio politikora bultzatzen bait dute. Apustu hau Espainiako Estatuan Erreforma politikoa finkatzea eta sendotzekoa da; eta honetarako itxura aurrerakorrez hornitu eta jantzi beharra dauka batez ere langileen eta herritar mailen aurrean; eta bestalde, sektore atzerakoiei amore eta poz emateko edukin atzerakoiz osatu behar du. Ordenadun indar bezala aurkezten bada, langile-klasearen jokaerak moderazioz sisteman integratzeko gauza dena bezala, eta lan hau burutzea lortzen badu, badaki nazioarteko burgesiaren, eta noski, estatukoaren oneritzia eta babesa izango duela. Eskuinari espainiar nazio haundiaren bandera kentzea lortzen badu eta euskal nazio-askatasunerako prozesua baztertzen eta desegiten adorez eta irmotasunez jokatzen badu, badaki Espainiako armadaren eta oligarkiaren inolako beldurrik gabe bizi daitekeela. Eta gainera eskubiari ekonomi austeritate-egitasmoak kentzen badizkio eta hitzez eta egitez merkatu libreko ekonomia defenditzen badu eremu soziologiko guztiak eta "zentru" politikoa betetzea lortuko du.

Egia esan aldebiko jokoa da, eta aldi berean, irmoa, nola barne-politikan ala kanpokoan. Denak kontent uztea, zerbaitetan bederen pozik uztea, bilatzen den jokoa (tentsio haundiko sarea nazionalizatu baina enpresa elektrikoei dibidendo ederrak utziko dizkien etekinak ziurtatuz, Rumasa inkautatu baina ez dela nazionalizatuko bermatuz, "habeas corpus"ari buruzko legea bultzatu eta ZEN plana martxan jarriz, kanpo-politika aldi berean hirugarrenmundutiarra eta OTAN-aldekoa eginez). Egia da joko honek bere ezkerrean mugitzen diren indarrak ahultzea lortu duela, eta baitere bere eskubikoak. PCEk deskalabro izugarria jasan du eta berriro burua altxatuko badu, baldin eta inoiz altxatzen badu, urte askotako lana beharko du. CCOO krisi sakonean sartua dago eta UGTrekiko, estatuko sindikatu nagusi bezala itxuratzen ari den honekiko, iharduera-eremua galtzen eta galtzen doa, gero eta nabarmenago. APk argiro erakusten du bere goren maila, hauteskundeei dagokionez, ehuneko hogeitazenbaitetan jartzen duela; eta honek zera adierazten digu: burgesia bera zuzenki ordezkatuko duen indar politiko baten bila ari dela berriro. Burgesiak bere ordezkaritza bilatzerakoan, ez du baztertzen gaurko AP-ren hauteskunde gailurra, hauteskundeetan lorturikoa gehitzea ahal bait da izen horregaz edo beste eskumatar koalizio batez. Horrela, egoera berria sor liteke; PSOEren izenean sozialdemokrazia eta delako eskumatar koalizio hori, biak gobernuan elkar errelebatzen egotea gerta litekeelarik. Azken finean boterea burgeseriaren esku mantenduz, bloke bi horietatik burgesiari batek ere kontraesanik sortu gabe. Azken finean, gobernuan bipolarizazio politikoa gertatuz.

Planteiamendu ireki eta nahita ideologiarik gabekoaz, PSOEk estatutuaren administrazio berria finkatzeko behar zituen kuadro tekniko eta burokratikoak "botereaz" gozatzera erakartzen jakin du. Bere arerioek aurpegiratzen dioten gobernatzeko experientziarik ezatik abiatuz espero zen baino efikazia-maila altuagoa lortzen ari da, noski, gero eta erreformismoaren morroiago bihurtuz eta estatuko langile-klasearen eta herri maila aurrerakorren interesetatik aldenduz, urrutiratuz.

Egoera honetan, nola eskubia hala PSOE bera ere pentsatzen jarriak daude gobernuan "egote" hori oraingo hauteskunde-aldi hau baino luzeagoa izan daitekeela (eta bi

legegintz aldi bete ere bai, agian). OTANi buruzko erreferenduna eta EEEan (Europako Elkarte Ekonomikoan) sartzea alde bitara jokatzen ari den joku etengabeko honetan garaipena lortu ahal izateko hainako bi baza izan daitezke (1986ko espainiar parlamenturako hurregon hauteskundeen atarian).

Eta hementxe kokatzen da PSOEren apustuaren goren asmoa: ERREFORMA TXIKIEN BIDEZ ETA DENBORA PASATZEN UTZIZ (FRANCOREN GARAITIK ALDENTZEN JOATEA, ADINA DELA MEDIO OLIGARKIAKO ELEMENTU NAGUSIENAK DESAGERTZEA, ETA BERDIN ARMADAKO ELEMENTURIK ZAHARRENAK ERE), ZENTZU SOIL-SOILIK LIBERAL BATEN BIDEZ GIZARTEA ETA ESTATUKO APARATUAK ERREFORMATZEA LORTZEA. HONELA, HISTORIAN LEHENDABIZIKO ALDIZ ESPAINIAKO ESTATUAN DEMOKRAZIA BURGESA SENDOTUZ.

Hauxe da gutxigorabehera, PSOEk lortu nahi duena; eta estatuaren aparatuetan sarturik jarraitzen duten diktaduraren elementuak eta bere aurrean duen krisi ekonomiko sakona gutxiesten duen bitartean. Bere alde masengan sortu duen efektu psikologiko horrekin jokatzen du; masak 1977an zeuden egoera beretsuan aurkitzen bait dira, une historiko honetan aldaketa politikoak posible direla sinestuz, eta oraingo kasu honetan berriz, PSOEk agindu ALDAKETA sinestuz.

BAINA BERE ITXURAZKO SENDOTASUN POLITIKOA KONTRADIKZIOZ BETETAKO SUMENDI BATEN GAINEAN ERAIKITZEN DA, ETA HAUEK EDOZEIN UNETAN LEHER DAITEZKE; BATEZ ERE NORBAITEK AREAGOTZEN BALDIN BADITU. ETA ZENTZU HONETAN, BERE AURREAN DUEN ARAZORIK NAGUSIENA, ETA HALA AGINDU DUENEZ BETE BEHARREZKOA, NAZIO-ASKATASUNERAKO EUSKAL MUGIMENDUARI ERASOTZEA DA.

– Ezaugarri "berriekin" jarraituz, Hego-Euskadin PSOEk eraman duen "pragmatismo politikoaren" eragina bere osotasun guztian aztertu behar da. Hau aski nabarmen agertzen da azken hauteskundeotan PSOEk lortu duen gorakadari begiratuz, eta PNVk udal-hauteskundeetan lortu duen igoera garrantzitsuari begiratuz. Pragmatismoaren gorakada da hau, zeren eta, itxuraz bederen, Baskongadetako eta Nafarroako autonomi erakundeen balioaren konfidantza sendotzea adierazten bait du. Erakunde hauek administrazio-deszentralizazioaren sabaitik askoz gorako kasik ez direla igotzen gauza aski ziurra da; ez LOAPAgatik bakarrik, baizik eta PSOEren gobernuak muga hau ezin duelako eta duelako nahi gainditu. Bestalde, Nafarroa Baskongadetako Autonomi Komunitatean integratzeko bide guztiak itxirik utzi dira. Horregatik, PSOEri bere botua ematen dionarentzat berriz, alderdi honek ederki asko jakin du ahalgarritasun edo posibilismo politikoaren hariak ukitzen, garaipen bikaina lortuz gainera. Gure iritziz, ahalgarritasunaren asmo eta bide hauek laster itxiko, amaituko dira, batez ere hurrengo baskongadetako autonomi hauteskundeetatik aurrera; baina ordurarte eta orduan ere paper garrantzizkoa jokatuko du PNVk. Erakundeak, dudarik ez, nahiz eta inolako subiraniarik ez izan, eguneroko bizitza honetan errealitate bilakatu dira eta ahaz ezin ditugun interes-multzoa bideratzeko balio dute. PNVk, PSOEk Madrilgo Gobernuan bezala, Botere-konzentrazioz eta haundiustez aurkeztea lortu ahal izan du; nahiz eta hau dena PSOErena baino itxura gehiagokoa izan; eta honek interes askoren atxekimendua eskaini dio.

Azken finean, "irabazleari" botua emateak halako poztasun bat ematen dio kontzientziarik gabekoari. PNVk, Baskongadetan, erakunde politiko gehienen kontrola edukitzez aparte, erakunde ekonomiko guztietan barne-barneraino sartzea lortu du (Aurrezki Kutxa, Merkatal Ganbara, enpresa asko eta asko, eta Bankan ere zertxobait bai). Eta honek bere eraginpide guztiak elkarren artean erlazionatu ahal izateko bidea ematen dio, eta bere gobernuko iharduerari nolabaiteko irmotasuna eta sendotasuna eskaintzekoa.

Hitz batetan, erakundeak harea gainean eraikiak daude, neurri haundi batetan, itxura hutsa baino ez dira, baina hau oraindik ez du ikusten herriarren gehiengoak, eta gure kontzientziatze-lana oraindik ez da geure eremu politikoaren mugetatik kanpora atera. Nafarroan, gure prozesuaren linea, poliki eta mantso ari da umatzen. Nahiz eta hauteskundetako datu hotzek HBren atzerakada adierazi, errealitatea besterik da; koalitatiboki, botuak nazio eta klase-kontzientzian aurrerapen bat adierazten duela, hain zuzen, egitasmo aurreratuago bati emandako erantzuna izan bait da. PSOEren eta Nafarroako eskubiaren arteko oreka desegonkorra beren kontraizanak areagotzeko zirkunstantzia aldekoa gerta daiteke; baitere bien arteko loturak eta batasunak agerian jartzeko. Baina bistakoa da Herrialde honetan nazio-kontzientzia birreraikitzeko langintza garratza dela oraindik. Halata guztiz ere, Herrialde honetan ematen da nazio-kontzientziaren eta kla-

se-kontzientziaren arteko loturarik haundiena. Berezitasun honek gure oraingo eta gerorako borroka-planteiamenduetan oso kontutan hartzeko ahalmen esanguratsu eta garrantzitsua ematen dio Herrialde honi, batez ere, burgesiarentzat eta sozialdemokraziarentzat Nafarroan auzia "Estatuko arazo" izango dela beti kontutan izaten badugu.

— Orain azaldu dugun arazo hau aztertuz, baina beste ikuspegi batetik begiraturik, Hego-Euskadiko kojuntura politikoan alde "berri" batzu ikus ditzakegu. Lehena, PSOEk, bere hauteskundetako garaipenean eta estatuan eragin formal osoa berea duelako zirkunstantzian oinarrituz, baskongadetako sentimendu espainolista guztiaren akaparatzaile bakar-bakarra, sentimendu hau jasoko duen organizazio bakarra bihurtzeko duen gogo eta asmoa. Estatu-mailan zentrua bere egin badu, baskongadetan nazio-kontzientziarik sentitzen ez duten sektore guztiak beregana ditzake. Industri konzentrazio haundia dagoen zonatako langile-klasearen sektore zabalen eraginarekin kontatzea adierazten duen zirkunstantzia honetan oinarrituz, bi komunitateen zatiketa bultzatu nahi izango dute, elementu neutraltzaileak eta ahulerazleak sartzeko asmoz, beraiek Nafarroaren eta baskongaden artean sortu duten enfrentamenduaren antzeratsu. Baina, batez ere, bilatzen dutena zera da: lehen fase honetan bederen, UCDk lehenago egin nahi izan zuen bezala, baina orain indar eta adore haundiagoz, Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendua baztertzen, murritzen eta deusezten ahalegintzea, edota, besterik ezean, noizbaiteko negoziaketaren batetan bere baldintzak jaistera behartzea.

## III) SOZIALDEMOKRAZIA, KRISI EKONOMIKOA ETA LANGILE-MUGIMENDUA

Sozialdemokraziaren egitekoaren alderdirik garrantzitsuenetakoa krisi ekonomikoaren kudeatzaile izatea bere ondorio guzti-guztiekin onartzea da; langileen begiek ikusten ez duten egitekoa, batetik, bere iragan sozialistagatik, eta bestetik, eskubiaren zakarra ez bezalako metodologia "zibilizatua" erabiltzen duelako, baina, azken finean, ondorio berdinetara heltzen dena. Sozialdemokraziak ongi asko daki bera Gobernuan egotea langileen interesen kontrako diren egitura politiko eta ekonomikoek sortutako tentsio sozialetatik askatzeko zerbi dezaketen aldaketa-itsaropenak sorraraztean datzala. Zentzu honetan, PSOE Kapitalaren interesetatik gero eta hurbilago dagoen gastu publikoaren politika eraman beharrean gertatuko da; eta politika hau, alde batetik, sektore publikoa errentagarri izaten eragoztea eta kapital pribatuari eta multinazionalei merkatu-kuotak harrapa diezazkieketen moduko enpresa dinamikoak edukitzen galeraztea izango da, eta bestetik, gizarte-laguntzarako gastuak murritzea, honela fondo publikoak ekonomia pribaturantz zuzendu ahal izateko.

Gobernuak estatua Europako Elkarte Ekonomikoan sartzea lortzen duenean, zeina erdi-deseginik eta porrot-zorian aurkitzen bait da, arrakasta izugarriko garapen politikoa lortuko du, eta honek aldaketa-itsaropenak sendotzeko eta sozialdemokrazia politikoki finkatzeko balio ahal izango du. Txanponaren beste aldeak zera agertzen digu: porrot-egoeran aurkitzen den Europako Ekonomi Elkartean sartzeak jasan ezinezko kostua suposatzen duela, zeren eta altzairu-produkzioaren murriztea adierazten bait du, fruitu eta barazkitarako erregadiko lurren, arrainuntzien, untzigintzako industriaren, oihalgintzako industriaren etab. etab.en murriztea. Guztiz adierazkorra da "gobernuaren sindikatuak", UGTk, industri birkonbertsioari dagokionez, estatuko industri sistemaren eta Elkarte Ekonomikoko herrietakoen arteko interdependentzia eta elkar-osagarritasuna defenditzea. Honek zera adierazten du, inolako itzulingururik gabe, Inperialismoak Espainiako Estatuari eta Hego-Euskadiri Lanaren Nazioarteko Banaketa berrien adjudikatzen dien papera onartzea; zeinaren azken helburua sistema kapitalista honen krisi ekonomikoa bere alde eta faboretan konpontzea bait da. Honela, estatuaren ekonomia globalki katea Inperialistaren menpeko bezala jartzea finkatzen da, eta partikularki, mundu subdesarroilatuari dagokionez, honen erdigune eta zentru bezala eraikitzea. Hego-Euskadin, industria haundiak krisiaren aurrean erortzen ari dira eta ez dira berriro altxatzen, zeren eta industria hauek bait dira mundu-mailako krisiaren aurrean erasanenik geratu direnak. Egoera larri hau euskal ekonomiaren espezialtze zeharo kaltegarriaren ondorio da. Burgesiaren asmoek euskal gizarte gutxiago proletarizatua eraiki nahi dela adierazten digute; zeren eta soluziobide bezala industria kapital haundiko eta lanesku urrikoak sortzera jotzen bait da; eta honek, azken finean, oraindik ere lanpostu-desegiteko periodo luze-luzea geratzen zaigula esan nahi du.

Sozialdemokraziak lan-mailan daraman jokabidearen funtsa langile-klasearen batasuna desegitea da, kontzeptu honen ordez beste zabalagoa, "klase-langilea" erabiliz, bertan jendetzaren sektore haundiak bilduz, erdi-mailak eta herri-mailak, eta erdiko burgesia bera ere bertan sartuz. Honek, langile-klaseak bere nortasuna galtzera eramaten du, eta kapitalari eta aginteko ideologiari erasotzeko moduko gidaritza politikoaren ausentzia ahalbidetzen du.

Borroka-indarra murriztea oraindik areagotu egiten da Asanblada edo Biltzarrea organu erabakitzaile bezala baztertzeaz eta sektoreka eta federazioka zatitzeaz; honela langileen arteko harreman bete-beteak eta beren arazoen ikuspegi orokorra eragotziz.

Guzti honi lan-harremanetarako marko autonomoak aitortzeari uko egitea gehitu behar zaio, betiere estatu-mailako partehartzea bakarrik bilatuz, indarrak ahultzeko asmoz eta langile-borrokak klase-borrokaren marko autonomoetan "isolaturik" ematea galeraziz, batez ere Hego-Euskadin, non sozialdemokraziaren politika, langileen zatiketaren metoduaren osagarri bezala, herria bi komunitatetan, bertakoen eta inmigranteen artean banatzea saiatzen bait da.

Ez da harritzekoa, beraz, CEOEk UGT goraipatzea, bere "zuhurtziaren" eta "erantzukizunaren" bidez herri mobilizazioak frakasatzea lortu duenean. Nabari-nabarian dago PSOEko eta UGTko gidarien artean konpromezu estua dagoela, naziozgaindiko kapitalaren estrategiarekin batera. UGT kapitalismo basatiaren garaiko mundura atzeratzen gaituela dirudien moduko lan-erlazioen markoa bultzatzen ari da Langileen Estatutuaren, Enpleguaren Oinarrizko Legearen, AMIren, ANEren, AIren eta antzeko legeen bidez (despido librea, lan-erritmoak gehitzea, produktibitatea gehitzea, benetako soldaten etengabeko beherakada etab.en bidez). Eta UGTren sindikatu-mailako politikak ez du Kapital Haundiak planeiatutako industri birkonbertsioa lagundu besterik egin, "langabetuen taldea" gelditu gabe ugaldu baino egiten ez duen birkonbertsioa, hain zuzen.

PSOE eta UGT martxan jartzen ari diren "Krisiari Irteera Konpartituaren" ildo maisuak honetantxe oinarritzen dira:

- Lan-harremanen flexibilizatzea.
- Krisian dauden sektore haundien behinbetiko birregituratzea.
- Kanpo-sektorearen askatzea.
- Sektore publikoaren razionalizazioa.
- Sektore finantzariaren askatzea.

Guzti honek zera esan nahi du:
a) despido librerako erreztasun gehiago,
b) langabezia gehitzea,
d) benetako alokairuak gutxitzea,
e) enpresa publiko ez-errentagarriak eta gizarte-laguntza okerragotzea,
f) entitate finantzariek beren fondoak inbertitzeko askatasun haundiagoa

SOZIALDEMOKRAZIA ETA ERREPRESIOA.

Inperialismoak Mendebaleko Europan "Bake-Txokoa" dauka; hemen langile-mugimenduak ia-ia ez dio erasotzen eta nazio-askatasunerako mugimenduak zeharo ahulduak edota jaioberritan daude. Halere, Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduak indar eta zentzu haundia hartu du, eta honek Inperialismoa eta beronen morroiak nahiko urduri jartzen ditu; morroi hauen artean sozialdemokrazia bera ere aurkitzen delarik; zeren eta Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendu garaileak Mendebaleko Europan zirriztu iraultzaile bat gertatu dela adieraziko bait luke, eta honela, beste zenbait prozesu ere bidean jarriko lirateke. Arrazoin honengatik, eta duen filosofiagatik, Inperialismoak ez du errepresioa beste biderik aurkitzen bere interesak gorde ahal izateko. Eta sozialdemokraziak, bizitzen jarrai ahal izateko, ez dauka Inperialismoaren egitasmo eta plan hauen beterazle zintzo bihurtu beste biderik.

Ikuspegi honetatik, Europa "demokratikoa" delakoarekin pareka, homologa daitekeen estatu "demokratikoa" bilatzen da, hori lortu nahi da. Baina "bakean" aurkitzen den "demokrazia" bezala agertu nahi izan arren kanporantz, iraun ahal izateko errepresiorik gogorrena eta sofistikatuena, frankotiar garaikoa baino basatiagoa, baina kanporantz "zibilizatuagoa" erabili beharrean aurkitzen da.

Lehen pausoa euskal gizartea bi komunitatetan banatzea da; baina kasu honetan ez bertakoen eta inmigratuen artean, baizik eta, alde batetik "jokoko erregelak" onartzen dituztenak jarriz, eta bestetik, joko-erregela hauek onartzen ez dituztenak, batez ere Erreformaren erakunde-markoa onartzen eta arbuiatzen dutenen artean. Honela, ordena publikoa kontzeptu "demokratiko" bilakatu da. Eta gaizkile edo delitugile hori izateko gauza den edonori deitzen zaio. Honela, gaizkile dira marginatuak, subproletariatua, gutxiengo etnikoak, eta errepresio-zorabioaren gailurrean, anorakdun gazteak eta neska dotoreak.

Plan errepresiboak onarpena bermatzeko, lehenik, informazio eta ideologizazio-intoxikazioa ematen da, herriak gobernuak "ordena publikoa" zaintzen eta gordetzen gogorki eta irmoki jokatu beharra daukala uler dezan, eta horretarako Konstituzioa bera

eta askatasun demokratiko apurrak ere hankapetik pasa beharra, Barrionuevoren ZEN planean bere gordintasun osoan kanporatzen den bezala, zeinak ez bait digu ezer berririk erakusten, Europa "demokratikoan", batez ere Alemania Federalean, erabiltzen diren plan errepresiboen kopia besterik ez denez.

Hementxe hurrean dugun plan errepresiboa ez da FOPak eta FASak gehitzera bakarrik mugatzen, gerra-instrumentuak gehitzen soilera, baizik eta, arma askoz ere sofistikatuagoen bidez (korrespondentziaren kontrola, urrutira entzutea, telefonoz entzutea, fitxa eta karnet elektronikoak, informazio-kontrolerako datu-bankuak etab. etab. . .) aurrera darama bere errepresio-lana. Halaber, legeria arruntetik eta apartekotik eratorri arma juridikoak ditu berekin, benetako salbuespen-estatuak eginez, eta honela, Bismarkek esaten zuen bezala "asto batek ere agintzeko moduan".

Segurtasun-kontzeptua Pinocheten erara defini daiteke; honela: "Segurtasunak nazio-ekonomia multinazionalen agindu eta beharretara makurtzea eskatzen du, autonomia politiko nazionalak erabat ukatzea, helburu politikoak helburu militarren azpian eta menpe jartzea".

Eta aparatu militar eta polizienak duten atzera eraginarazteko gaitasunari, eskolako eta familiaren aparatuek duten deformatzeko eta komentzitzeko gaitasunari, lehen herriko sektore haundien borroka-lanabes ziren (alderdi, sindikatu . . .) horiek orain duten integrazio-botere indartsua gehitu behar zaie; orain kolaboratzaile bihurtu bait dira, borrokan agertzen diren tentsioentzat aterabide eta hauen baretzaile, nazio eta klase-arazoak asimilatzeko mekanismo, hain zuzen.

Sozialdemokraziak badaki Hego-Euskadin bere errepresio-planak aurrera eramateko kolaborazioa, laguntza behar duela. Horretarako, PNVren kolaborazio isilkako edo pasiboa zehatza, expresoa eta aktiboa bilaka dadin saiatuko da. Baskongadetako Parlamenturako hauteskundeen ondoren, PSOEren eta PNVren artean eman daitekeen edo ez kolaborazioaren alde hau txit garrantzitsua bilakatuko da. Horretarako, PNVren egitekoa eta bidea aztertu behar da.

## IV) PNVren EGITEKOA ERREFORMA POLITIKOAN.

Erreformaren bigarren etapa deitu dugun honetan, garrantzia haundikoa da PNVren papera aztertzea, nola bere plan ekonomikoei dagokienez hala Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduari dagokionez.

Erreformaren Erreferendunean parterik hartu ez zuen PNV, bertan buru-belarri Ekainaren 15eko hauteskundeetan sartu zen (barne-kontraizan gogorren artean).

Kontraizan hauek argiro eta zakarki isladatzen dira Konstituzioari bai ala ez esateko orduan; onartu ala ez-onartu eztabaidatuz, alderdiaren jabetza lortzeko barne-gerra bezala kanporatzen diren borrokak, hain zuzen, eta ez hainbeste, bere baseen aurrean itxura politiko jatorra gorde asmoz. Arzallus eta belaunaldi politiko berria agintera iristeak PNVri euskal burgesiak bereak dituen interes ekonomiko eta sozialei loturiko linea ezartzen dio. Lehendabiziko ukatzetik Konstituzioa onartzera pasatzen da, eta noski, honen ondorio gardena dena, Gernikako Estatutua onartzera.

Pauso politiko hau ere kontraizanez beterik agertzen da; bertan, alde batetik, Euskal Herriaren burujabetza eta autogobernu-sentimentu indartsua era demagogiko batez erabiltzen da, eta bestetik, burujabetza honetan Estatutuak ezin dezakeela ezer garrantzizkorik eskaini argi eta garbi ikusten da. Guzti honen islada Hego-Euskadiren zatiketa eta banaketa erakundetiarra eta lurraldetiarra onartzea da, legegintz gaitasun izpitxo bat baino gehiago onartzen ez duen arauteria bat onartzea, eta Euskal Herriak bere nazio-nortasuna birreskuratzen lagun diezaiokeen arau-ahalmenik eza onartzea.

Gernikako Estatutua onartzeak (bere barnean beste estatutua, Nafarroako Foruaren Hobekuntza onartzea suposatzen duenak) bai eskubiaren eta bai sozialdemokraziaren projektu politiko komunari erantzuten dio zuzen-zuzenean, hau da, espainiar estatua politikoki eta sozialki berriro egituraratzea, laneko eta ekonomiako harreman-marko bezala antolatuz, eta honetan "administraziorako" orduan deszentralizazioak paper garrantzitsua jokatuko duelarik. Projektu hau erabat onartzen du PNVk, batez ere bere interesen aldeko izan daitekeen burgesiaren eta inperialismoaren Lanaren Nazioarteko Banaketaren projektuari erantzuten dionez. PNVk, honela, "Euskadi Espainiako Estatuaren barnean merkatu-marko berezi"tzat onartzen du. Kontraizan garrantzitsua da PNVk, euskal burgesiaren ordezkari den aldetik, espainiar sozialdemokraziaren aurrean bere hegemonia politikoa galdu behar izatea.

Kontraizan honen azpian beste bat haundiagoa ezkutatzen da, Euskal Herriko sektore haundiek bere egin duten nazio-borrokarena, alegia; sektore hauetatik botu asko eta asko PNVra doazela kontutan izanik. Alderdi honek ongi asko daki sektore hau menderatzen jarraitzea dela Erreforma-prozesuaren bermerik seguruena; eta horregatik, jarrera radikalagoetara ez dezaten ihes egin ahaleginduz, PSOEren aurrean konfrontazio linea hartzen du.

PNV NAZIO–ASKATASUNERAKO EUSKAL MUGIMENDUAREN AURREAN.

Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendua prozesu iraultzaile batean erabat sarturik aurkitzen da, gizartearen erabateko aldakuntza-prozesuan, honek adierazten duen indar-pilatze, masa-kontzientziatze, hauek dinamizatze eta mugiarazte eta guzti, hauek independentziarako eta sozialismorako estrategia bete-betean partehar dezaten. Ideologia burgesarentzat ezinbestekoa da Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduari erasotzea, honek sistemaren iraupena zalantzatan jartzen bait du eta kapitalismoaren barne-interesak arriskutan.

Alde batetik, PNVk koltxoi-papera egiten du Euskal Herrian hain zabaldurik aurkitzen den independentismoaren aurrean, ahalgarritasunen eremuan jokatuz autogobernu eta burujabetza-egarriak Gernikako Estatutuaren eta Espainiako Konstituzio-Ordenamenduaren bidez horiek bere baitan bideratzeko. Pauso hau behar-beharrezkoa da Erreformarentzat, honela Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduari indarrak murrizteko. Baitere, burgesiarentzat behar-beharrezkoa da Erreformaren eta Iraultzaren artean dagoen erlazio dialektikoa apurtzea eta haustea, KAS eta HB deusezten saiatuz eta politika-definizioen mailan PNV-PSOE bikotea bultzatuz.

Alde bikoitz honetan biltzen da PNVren luzarorako maliobra. Lehen helburua Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendua isolatzea eta/edo deuseztea bada ere, beste aldetik, euskal burgesiaren zati baten ordezkari bezala iraun beharrean gertatzen da, eta honetarako indarrak pilatu behar ditu, eta indar hauek nazio-egitatearen aldetik etorriko zaizkio, behin Erreforma finkatuz gero, zentralismoari erasotzeko, nola sozialdemokraziak ordezkatua dagoen hala gerora eskubiak aurkitzen duen beste edozein konponbiderik ordezkatua.

PNVren PROZESUAN BALDINTZA SUBJETIBOAK.

Burgesia erdirakoiak PNVren alde jokatzen badu, honek betetzen duen bitartekopaperagatik da. Eta hemen agertzen da lehen kontraizana: Autonomi prozesua narrastua, murriztua dago; eta PNVk, pauso honetan oinarritu zenak, bere nazio-hegemoni usteentzat galga bat aurkitu du. Burgesia erdirakoiak badaki PNVren hegemoni sendotzeak Erreformaren garaipena ekarriko badu ere eta hori bermatuko, aldi berean burgesiaren frakzio bat sendotuko litzatekeela, zeinak, nahiz eta estatuari lotua egon, bere definizio propioa edukiko bait luke eta bere alderdiak babestua eta funtsatua egongo bait litzateke, hau da, PNVk gordea, eta arazo hau ez da Kapitalak gaur egun daraman jokoaren barnean sartzea.

Bestalde, PNVk bere barnean, eta euskal langile-masei dagokionez, kontraizan sakon bat du. Erreforma-prozesuaren aldeko apustuak, Gernikako Estatutuarekin eta Nafarroako Foruaren Hobekuntzarekin, argi eta garbi ikus daitezkeen moduko konkreziorik ez edukitzean, Hego-Euskadiren zatiketa onartzean, herri-interesetatik urruti dagoen eta Madrilgo gobernuaren politikaren antzeko politika sozioekonomikoa aplikatzean, bere botuemaileen artean mesfidantza sorrarazten du eta politika honen aplikazio-orduan barne-eztabaidak areagotzen. Bere hauteskunde-konbokatoriarako gaitasuna ez galtzearren, PNVk estatuko gobernuaren eta baskongadatako gobernuaren arteko enfrantamenduaren eta borrokaren alde gogor jokatuko du eta apustu egingo, borrokak kapitaltzeko asmoz eta kaleko deskontentaz baliatzeko, guztiau Madrilen aurka erabiltzeko arma bezala hartuz; eta era berean Gernikako Estatutuaren urritasuna ere, beronen Erreforma proposatuz eta horrekin mehatxu eginez.

PNVk, bere agerpen eta manifestaldietan naziotasun-zentzu hau azpimarratuz, azkenengo udal-hauteskunde hauetan berari botua eman diotenen kopurua igotzea lortu du. Honek epe laburrera, Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduari kalte egin liezaioke, konfusioa sortzen bait du; baina PNVk estatu-mailako estrategia hartzea eragotzi ahal izan du, eta luzarora gidaritzaren (burgesiaren zati baten) eta bere baseen arteko kontraizana areagotzea egingo du.

Badaiteke itxura nazionalisten politika hau baskongadetako Parlamenturako hauteskundeen ondoren alderdiko gidariek baztertu nahi izatea, euskal burgesiaren interes ekonomikoak funtsean PSOEk interes kapitalisten zerbitzurako desarroilatzea prestaturik duen politika ekonomikoarekin koinziditzen dutelako, hain zuzen. Baina honek

kontraizanak sortuko ditu gidaritzaren eta baseen artean, eta seguraski, PNVk ezingo du nazio-arazoa erabat baztertu.

IHARDUERA–LINEAK.

Erreformaren baldintza objetiboetatik eta PNVren subjetiboetatik, zeintzu nahiz eta barne-kontraizanez beteak egon elkarrekin hestu-hestu lotuak aurkitzen bait dira, ondorio batzu ateratzen dira, nola epe motzera hala erdiko epera jokatzeko iharduera-lineak desarroilatu beharra, alegia.

PNVren ahultasun ideologiko eta politiko egoeraren aurrean, nondik lehenbailehen ateratzea bilatzen bait du, bere forma nazionalistak areagotuz eta gogortuz, PNV mantentzen duen posibilismo kaltegarriaren aurkako borrokari ekin behar diogu, gure borrokak kapitaltzea bilatzen bait du horrek.

PNVren kontra gure Nazio-Askatasunerako borrokaren ezaugarriak ezarri behar ditugu argi eta garbi, Subirania Nazionalaren bilako herri-partehartzea bultzatuz, PNVk jokatuko duen sustituismo edo ordeztakeria baztertuz. Hitz batean, Herri Batasuna nazio-erreferentziaren gunea bihurtu behar dugu, KAS NAZIO–ASKATASUNERAKO EUSKAL MUGIMENDUAREN abangoardia bezala argi eta garbi finkatuz. Honek estatu-mailako eta nazio-mailako estrategien artean dagoen kontraizanean finkatu beharra erakusten digu.

Laburtzeko, burutu beharreko lanaren lineak Euskal Herri Langilearen nazio eta klase-interesen ordezkari bakar bezala eraiki beharrean oinarritzen dira; honen Askatasunaren berme edo garantia bihurtu behar dugu; Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduaren jarraipena eta desarroiloa zainduz; Euskal Herriaren Nazio-Subiraniaren aurka etsaiak, hau da, gaur egun sozialdemokraziak, hartzen duen estrategiari uneoro arreta haundiz begiratuz.

## V) NAZIO–BERRERAIKUNTZAKO ALTERNATIBA DEMOKRATIKOA.

Orain arteko analisi eta azterketen ondorioz zera diogu eta defendatzen dugu: Erreformak Hego-Euskadin frakasatu, porrot egin duela; zeren, lehenik,ez bait du nazio eta klase-kontzientzia bereganatzea, murriztea edota baztertzea, eta ondorioz, Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendua bereganatzea, murriztea eta baztertzea lortu. Eta bigarren, Hego-Euskadi jasaten ari den krisi sakonari ez bait du zentzu kapitalistako konponbiderik ezartzea lortu.

Halata guztiz ere, erreformismoak, Erreformaren lehen etapan gertatu zen bezala, masengan izugarrizko eragin psikologikoa du, erakarpen ikusgarria du. Sozialdemokraziak, botere-maila itxuraz bederen nahiko trinkotik, eta Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduaren aurkako borroka psiko-soziologikoan laguntza guztiak (oligarkia, botere faktikoak eta euskal burgesia) dituela jakinik, alor honetan bere ahalegin guztiak egingo ditu. Arrazoi honengatik, arma berdinekin erantzun beharra dago, eta planteiatzen den borroka ideologikoarekin batera gure aldetik persuasioa eta sugestioa sortzeko moduko edukinak eskaintzen ahalegindu behar dugu; baina, noski, zentzu erabat desberdina emanez.

Liluraren edo sugestioaren erabilera ustela gure inguruan salatuz eta kontraatakatuz ezin gaitezke gera (gure komunikabideak etab. erabiliz). Haiek badakite, barne-kontraizan batzu sortzez aparte, beren sugestioak (ordenaren ontasuna, bake "demokratikoa", Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduko kideak gizartearen etsai eta kriminal bezala agertzeko ahaleginak) ez diela gure baseei erasaten. Gu baztertu egin nahi gaituzte, zokoratu, eta gure barneko kontraizanak areagotu (zeren eta badakite, guk bezala, gaur egun Herri Batasunaren plataforman, sektore hegemoniko iraultzaile baten ondoan, beste sektore bat, prozesu honetaz nekatuagoa, biltzen dela).

Honela beraz, orain gurekin ez dauden alboko sektoreetan kontraatakatu beharra daukagu, zeren eta mugimenduaren indarra haunditzeko hauen beharra bait daukagu, gure borroka aurrera eramateko (langile-klaseko eta nazio-kontzientzia duten burgesia txikiko sektoreak). Horretarako, propaganda eta influentzia pertsonalak zabaldu egin behar dira, gure programa eta alternatiba hedatzeko.

KAS ALTERNATIBA.

Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimenduaren izaera aglutinatzailea eta funtsezkoa alternatibaren edukinarekin eta honen zabalkundearekin hestu-hestu lotua dago. Alternatiba hau zuzena, zeren euskal langile gehienek sentitzen eta nahi dutena jasotzen duelako, eta aldi berean askatasun minimoak garantizatzen dituen marko demokratikoa delako; Erreformaren frakasuak frankismoarekiko hausturarik gabe gure nazio-nortasuna-

ren iraupena garantizatuko duten oinarri demokratiko minimoak planteiatzea inolaz ere ezinezkoa dela frogatzen bait digu.

Hala eta guztiz ere, Erreformaren etapa honetan frankismoa zeharo maskaratua azaltzen zaigu (kontuan izan Erreformaren efektu ideologikotako bat, eta batez ere bere sozialdemokrazia-etapa honetan, hausturarik ez dela egon nolabait eskutatzea dela). Efektu honek, eta Erreformaren haseratik orainarte iragan denborak, eta egungo gobernukoak ez direla garai batetako faszistak, guztionek frankotiar jarraipenik iadanik ez dagoela ikusterazten laguntzen du. Hausturaz hitzegitea borroka ideologikoaren zati bat da; baina batez ere zera azpimarratu behar da: gure arrisku nagusia gure nazio-nortasuna deuseztekoa dela, herri bezala irauten jarraitzeko posibilitatea, alegia (zeren eta subiraniarik gabeko autonomia faltsuak, Nafarroa aparte uzteak, euskara bazterturik edukitzeak, muga hauek gainditzen ez badira, nazio-iraungipenaren prozesuari lagundu egiten bait diote).

Zentzu honetan, KAS alternatibaz hitzegitean, honek haustura bat baino gehiago Euskal Herriaren iraupenerako baldintza demokratiko minimoak, nazio-berreraikuntzarako benetako oinarriak, jasotzen dituela azpimarratu behar da.

Gaur egun mugitzen ari garen egoera objetibo eta subjetibo honekin bat egiteko, alternatibak Erreformaren etapa honetan protagonismo haundia jokatuko du, zeren eta botere faktikoek Euskadirako markaturik daukaten eta gobernuak eta espainiar estatuko egiturek desarroilatu nahi duten iharduera-egitasmoaren hiru zutabeak jasotzen bait ditu eta hauei erantzun egokia ematen. Hiru zutabeok hauek dira:

– Ekonomi birregituratzea, inperialismoaren planen pean.
– Errepresioa gehitzea.
– Euskal Herriaren burujabetza-egarriak ezabatzea.

Elementu hauek ez dira inolaz ere berriak, baina orain kobertura ideologiko askoz indartsuago baten pean aplikatuko dira.

Alternatibaren egitekoa berezi-berezia da etapa honetan; bere formulazioak herrierreibindikazio ezberdinak marko orokor batetan definitzen, arrazoitzen eta batzen laguntzen bait du, eta aldi berean, desideologizatze-maliobrei aurka egiten.

Erreformaren etsipenak sortu duen desorientazioaren, sinestezintasunaren eta desesperazioaren aurrean, erasanak gertatu diren sektoreak berriro ideologikoki armatu egin behar dira, eta irtenbideak zeintzu diren arrazoitu, irtenbideok orainarte aplikatzen ari direnetatik erabat bestelakoak direlarik. Horregatik, ezin gaitezke alternatiba formulatze hutsean gera, baizik eta Erreformaren egungo epe honi dagokion aldetik eta berau oinarritzen deneko ardatzei erantzuna emateko moduan zehaztu eta azaldu behar dugu.

– Ekonomi aldetik.
– Errepresioari dagokionez.
– Gure nazio-nortasuna zaintzeari buruz.

<u>EKONOMI ALDERDIA.</u>

Langileen bizitz kondizioen hobekuntzari buruz lehenago esan dugu gobernuaren projektua ekonomia inperialismoaren menpean jartzea dela, inperialismoa bait dugu ekonomia osoaren zentrua. Europako Elkarte Ekonomikoan sartzeko agindua, industri berkonbertsiorako projektuak, plantila-reajusteak, soldaten adkisizio-boterea galtzea, Kapitalaren konfiantza lortu asmoz, esaten ari garenaren froga argi eta garbia dira. Neurri guzti hauek biktima bakarra dute: Langile-klasea eta herri langile osoa.

Erreformismotik neurri hauek ezinbestekoak direla frogatu nahi da, hots, langileak konforma erazi eta desmugiarazi; lehenago genioen bezala, ideologi aldetik eta organizazio-mailan desarmatu. Gure egitekoa badagoela beste irteera desberdin bat azaltzea da, epe motzera eta luzera miseria gehiago ekarriko duen, eta nazio-askatasunerako prozesuan eragozpen, oztopo eta menpekotasun haundiagoa ekarriko duen irteera faltsu honen aurrean badagoela beste bat, alegia.

KAS alternatibaren alderdi ekonomikoak inperialismoaren kateari ahalik eta gutxien makurtzen zaion ekonomia eskatzen du, norberaren baliabideak ustiatuko dituen ekonomia, eta Euskal Herri Langilearen beharrak aseko dituen hein berean gero eta lanpostu gehiago sortzea ahalbidetuko duten ondasunak sortzera zuzendua. Autozentrismo ahalik eta haundieneko ekonomia izan behar du, poliki-poliki lehen sektorea indar-

tzera joan dena, gaur egun industri sektorearen nagusitasunagatik miseri gorrian aurkitzen den sektorea.

Noski, Euskal Herri Langilearen bizitz maila hobetzea garantizatzeko bide bakarra kapitalist erregimenaren suntsitzea besterik ez da. Baina sozialismora iritsi aurretik ere langileen gero eta miseri haundiagoari amaiera ematerik badago, aldakuntza benetan demokratiko eta sozialen baitan. Eta hau lortzeko helburua monopolioen eta Bankaren botere ekonomikoa mugatzea, murriztea da. Eta hauen iharduketaren gai kontrol demokratiko benetakoa ezartzea; eta halaber, moneta-politikaren kontrola eta kontsumoko oinarrizko artikuluen prezioen kontrola ere.

Herritar klaseen bizitz kondizioen hobekuntzak populazioaren gehiengoaren interesei erantzungo dien politika antiinflazionista desarroilatzea esan nahi du, eta ez gaur egun praktikatzen dena bezalakoa, langileen eskubideen kontra jokatzeko aitzakiaz.

## ERREPRESIO ALDERDIA.

Botere politikoek eta erakundeek arrisku bat dakusate: sistema politikoa beren funtzioez gaindik geratzen diren exigentziez zamatzea, eta honela "egonkortasun" politikoa arriskutan jartzea. Arrisku hau argiro azaltzen da sozialdemokraziak sortu dituen ilusioen ondotik, eta ilusio hauetara Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendua ez makurtzetik.

Mehatxu honen aurrean, bere metodo ideologikotako bat disuasioa izango da, errepresioa, alegia. Deklarazio eta iharduera-pilo batek, eta ZEN planak berak bide honetatik jotzen dute.

Estatuaren joera hau, inperialismoaren estrategia oso batekin hestu-hestu lotua aurkitzen da: Inperialismoak estatuaren segurtasuna botere exekutiboak bere egitekoa erabateko askatasunez eraman ahal izatea bezala ulertzen duenez, politika honen ardatz nagusi polizia eta armada bilakatzen dira.

Joera honek oraindik indar haundiagoa hartzen du estatuko aparatu errepresiboak ikutu ere egin gabe daudelako; eta aparatu hauek erabat faszistak dira, zeharo antieuskaldunak, beste ezerren gaindik. Hots, nazioarteko joera hau Espainiako estatuan eta batez ere Hego-Euskadin oraindik areagotu egiten da.

Honela beraz, orohar, borroka antierrepresiboak oraindik ere garrantzi izugarria du; zenbait sektore sozialek errepresio-projektu hau asimilatzea aparatu ideologikoek ahalbide dezaten ez uztea, hain zuzen.

## GURE NAZIO–NORTASUNAREN DEFENTSA.

Erreformako bigarren etapa honen helburu nagusia, Erreforma finkatzea, inperialismoaren zentrua prestatzen ari den Nazioarteko Lan Banaketa berriarekin bizitzen jarraitzea eta plusbalio berriak lortzea da; eta honetarako Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendua asimilatu, bereganatu edota suntsitu egin behar du.

Sozialdemokraziak badaki Hego-Euskadin klase-borrokak eta bere gizarte-mugimenduek nazio-askatasunerako borrokaren forma eta zehaztapena dutela. Horregatik, kapitala-lana kontraizan nagusia Subirania Nazionalaren eta Kapitalismo Inperialistaren arteko borrokan konkretatzen da. Projektu honek sozialdemokrazia agintean eta gobernuan egotea eztabaigarri bihurtzen duenez, honen soluziobidea herriaren subirani nahiak ahultzea da, eta horretarako euskal nazio-nortasunaren ezaugarriak hankapean xehetzeko beldurrik gabe jokatzen du.

Sozialdemokrazia erabiltzen ari den instrumentu ideologikotako bat espainiar txaubinismoa areagotzea da. Honela, euskal nazio-nortasunaren adierazpen oro arrazistatzat eta antisolidariotzat joa izango da, era honetara Hego-Euskadiko langile-klasea zatitu asmoz. Populazioa bertako eta kanpoko edo inmigrante bezala bereiztea, eta espainolismoaren erreferentzi gune bezala bere burua hartzea esaten dugun guztionen froga argi eta garbiak dira. Eta honi PNVren erakunde-aldeko politika gehitu behar zaio; bere klase-interesengatik politika zeharo antieuskalduna eta antiherritarra bait darama. Honela gure lana bikoiztu egiten da, gure nortasunaren ezaugarriak, eta berezi-bereziki euskara, indartzeko eta zabaltzeko ahalegin honetan.

Espainiar txaubinismoaren gorakada honetan, herria eta langile-klasea batzeko, biltzeko langintza honetan, ezin ditugu gure presupostuak jaitsi, baizik hezketa-lan bat bultzatu behar dugu, langile-sektore desnazionalduenei ikusaraziz espainiar txaubisnismoaren bidetik abiatzen badira beren langile-interesen aurka doazela, berdin da euskaldun edo ez izatea.

Berreuskalduntzea, eta ez bakarrik nazio-birreraikuntzarako nahitaezko elementu bezala, baizik eta bere egoera larriaren aurrean elementu aglutinatzaile bezala ulertuz, gure nazio-askatasunerako desarroiloarekin zerikusi funtsezkoa eta lotura hestua duen zerbait bezala aztertu behar da. Hots, ez da besteetatik kanpo geratzen den borroka bat, ez dago besteez gain, ez politikatik kanpo, baizik eta hauek guztiekin hestu-hestu lotua.

Berreuskalduntzeko bene-benetako politika batek zenbait alderdi ezberdin eduki behar ditu kontutan:

- Euskararen inguruan organismoak eta iniziatiba herritarrak indartzea, sendotzea eta koordinatzea.
- Euskararen zabalkuntzarako, gizarte-arlo guztiak eta batez ere hezkuntzakoa bultzatzea eta lehentasuna ematea.
- Hizkuntzaren egoeraren larritasunaren berri zabaltzea; eta berreuskalduntzearen alde zenbait gizarte-sektoretan dagoen kontrako joera apurtzea.

Gure nazio-nortasunaren defentsari dagokionez, aparteko garrantzia du autodeterminazio-eskubidea exerzitatu ahal izateak duen izaera demokratikoa azpimarratzeak; eta estatu-mailako estrategia ez onartzeagatik gu desagertzeko egiten ari diren ahaleginen aurrean nazio-mailako estrategia kontrajartzeak duen garrantzia ikusteak.

Alternatiba, bere edukin zehatzari dagokionez, demokrazia aurreratukoa deituko genukeen egoera baten formulazioa da; eta alternatiba hau lortzeak gure helburu estrategikoak, hau da, independentzia eta sozialismoa, lortzeko bidean pribilegiozko egoeran jartzen gaitu. Honela beraz, alternatiba lortzean, oligarkiari eta armadari beren funtsezko instrumentuak kentzen zaizkie, Hego-Euskadi menderatzeko dituzten instrumenturik funtsezkoenak, eta horregatik KAS alternatibaren estrategi zuzentasuna; erreibindikazio bakoitza beronekin lortzea ahalbidetzen duenez eta hori egitea beharrezkoa denez gero.

## VI) ORGANIZAZIO—LANA. ORGANIZAZIOAREN MAILA EZBERDINAK.

Nola epe motzean hala luzarorako eman behar dugun erantzunaren baitan, organizazioa maila guztietan berrindartzea eta desarroilatzea nahitaezkoa da, borrokako epe eta fase bakoitzari behar bezala erantzun ahal izateko.

Batez ere hiru nibeletan fijatuko gara: Alderdia, Blokea eta Herri Batasuna.

Blokeari buruz zehatzago mintzatzen gara beronetaz egin txostenean; eta Alderdiari buruz, berriz, txosten berorretan eta Estatutuenean. Horregatik, orain eta hemen, Herri Batasunari buruz luzeago arituko gara.

### ALDERDIA

Alderdiak ahalegin haundia egin behar du bere burua indartzen eta sendotzen prozesuaren egungo beharrei erantzun egokia ematen asmatzeko. Erreformaren bigarren epe honetan planteiatzen den borroka, eta finkatzeko duen azken oportunitatea izan daitekeena, aurreko etapakoa baino gogorragoa eta zailagoa izango da garaitzeko.

Alderdiaren egitekoa Nazio-Askatasunerako Euskal Mugimendua bere erakunde eta masa-borrokan osatzen duten organizazio-maila ezberdinak ideologikoki kohexionatzea eta dinamizatzea da. Egiteko bat, Bloke osoarekin batera Herri Batasunaren eta Bloke iraultzailearen arteko lotura dialektikoa praktikan egiaztatzea da. Gure lana prozesuaren barneko organizazio-maila ezberdinen izatea prozesu honetan kontzientzi maila ezberdinak daudelako gertatzen dela ikustaraztea da; borroka honetara sektorerik gehienak eta zabalenak erakarri behar direlako, hain zuzen.

Ez dago, beraz, organizazio-maila ezberdinen artean lehiaketa bat dagoenik esaterik; baizik eta denak elkar-osagarri direla. Ez dago Blokeko organizazioen finkatzea eta sendotzea gertatzerik Herri Batasunik gabe; honek masetatik urrutiratzea ekarriko bait luke. Eta ezta alderantziz ere; Herri Batasuna Blokearen kontura finkatzeak erreformismoan erortzea ekarriko luke eta.

Alderdiak, Bloke barnean duen egitekoagatik, ideologi eta organizazio-mailan barne-kohexioa eta globalizazioa lortzeko gaitasun gero eta haundiagoa behar du. Eta zentzu beronetan, funtzio berezia du, orain arte, egin behar izan ditugun lanengatik, aten-

ditu gabe eduki ditugun area eta sektoretan borroka-fronte berriak irekitzeko, hain zuzen. Alderditik, Blokeak betetzen ez dituen sektoreetan partehartzeko lineak analizatu eta finkatu behar ditugu, Blokeko beste organizazioekin batera tratatzeko eta gero Herri Batasunara eta masetara azaltzeko.

Alde guzti hauek organizazioaren egokitzea eskatzen dute. Eta puntu hau Estatutuei buruzko txostenean aztertzen dugu.

KAS BLOKE IRAULTZAILEA.

Azken urte hauetan, ezker abertzalearen garaipenik garrantzitsuenetako bat Blokearen sorrera izan da. Baina oraindik homogeneitatean eta hedakuntzan lan-egitea geratzen da, bere ahalbide politiko guzti-guztiak desarroilatu ahal izateko.

Blokearen ahalbidetasun izugarria bera osatzen duen organizazio-aniztasunean datza; alde batetik, organizazio espezialduak direlarik, eta bestalde ideologi homogeneitatea eta barne kohexio trinkoa dutelarik.

Arlo honetan Blokea sendotzeko izugarrizko garrantzia du honen eragina eta barnebatasuna batera joateak. Gainean dugun borroka honetan garrantzia ikusgarria izango du, lehenago esan den bezala, Euskal Herri Langilea ideologi aldetik armatzeak; eta honen erantzukizun-parte haundia KASek du, herriaren interes objetiboak defendatzerakoan eta nazionalismo burgesak eta sozialdemokraziak oligarkiaren interes inperialista antilangile eta antieuskaldunei eskaintzen dieten babes ideologikoa apurtzeko orduan.

Helburu taktikoen eta estrategikoen defentsa da espainiar zentralismo kapitalistaren ideologi kobertura hausteko instrumentoa; eta halaber, helburu hauek masen interes ezberdinekin lotzen jakitea, eta hauei edukin eta marko politiko egokia ematen jakitea.

Bloketik sektoreka eta lekuz-lekuz eskuhartzeko lineak desarroilatu begar dira, Blokearen erabaki baterakorrak eta orokorrak aurrera eraman eta burutzen dituzten bitartean, auzo, herri edo eskualde-mailan erabaki hauek aplikatzea sendotzeko moduan.

HERRI BATASUNA.

Herri Batasuna (Herriaren edo Herritar Batasuna) organizazio-mota berezia da, gure prozesu honetako beharrek eta zirkunstantziek erantsitako ezaugarri bereziez hornitua.

Organizazioek, jeneralean, beren kideen artean inter-erlazioak dituzte, barne-araudiak, aginte-egitura, helburuak, koordinaziorako eta integraziorako mekanismoak, informaziorako barne-sistemak. Gure prozesu honetan, borroka-mota ezberdinei erantzuteko lehen mailako organizazio espezialduak ditugu, gero organizazioen organizazio bat edo Blokea, eta Herritar Batasunaren organizaziorako egitura bat. Azken honek Blokeko organizazioetako kideak eta beste kide asko eta asko organizazioetan egituratu gabe daudenak biltzen ditu; eta horregatik, bigarren hauen organizazio-egitura eta erlazio-bide bakarra Herritar Batasun hau da. Militantzi eta egitura-mailaketa hau nazio eta klase-kontzientziaren desarroilo ezberdinak behartua da, hots emanzipazioa eta askatasuna lortzeko egarriaren eta hau lortzeko bide eta formen kontzientziaren araberako mailaketa da. Horregatik, guztiz logiko eta naturala da egitura zabalago baina gure prozesurako behar-beharrezkoa dela argi eta garbi ikusten den honen hegemonia eta gidaritza bere barnean egituraturik aurkitzen diren organizazioetatik, hau da, KAS Bloke iraultzailetik markatu behar izatea. Hau errealitate argia da eta Herri Batasuneko kide kontzientziarik haundiena dutenek asumiturik daukate; besteen konpromezu haundiagoa baliotzen duenez, eta edozeinen konpromezu haundiagoa asumitzeko ate guztiak irekirik dituenez. Egoera hau ez da zapaltzailea, ez du Herri Batasuneko kide arruntaren eskubidea eta askatasuna murrizten; Herri Batasunak berak hautatzen bait ditu bere gidaritzarako buruak eta bere burujabetza du, erabakiak eta batez ere herriko eta/edo herrialdeko Asanblada edo Biltzarretan hartuz.

Prozesuaren beharrek hasera batetan Altsasuko Mahaia izan zena eboluziona erazi egin dute; eta hasera hartako lau alderdietatik egungo HBra heldu gara, non bertan gaur egungo alderdiek, guztira bi, bakoitzak bere egitekoa betetzen bait dute, baina ez alderdi gisa, baizik eta HBren egituran bat-eginik.

Organizazioen ezaugarri berezietara itzuliz, hauek Herri Batasunaren barnean beste organizazio politiko itxiago eta zorrotzagoek ez bezalako ezaugarriak dituztela nabarmentzen du. Herri Batasuna ez da eta ez du izan behar beste alderdi politikoak bezalako alderdi-antzeko zerbait. Baina, ezta ere ez du izan behar pertsonaz eta organizazioz osatutako meta bitxi bat, non denak eta nornahi kabitzen bait da; eta ezta ere helburu eta kontsigna berdinen bilduma soila, indibidualismoa eta organizatu nahi-eza justifikatu edota indartuko lukeena. Bi ertzak baztertuz, zehatzago definitzen saiatuko gara.

Herri Batasuna (Herritar Batasuna) herriko elementu abertzaleen aliantza historikoaren egiturarik zabalena eta kanpokoena da; honen bidez gure nazio-askatasunerako prozesua aurrera eraman ahal izateko; iraultza sozialistaren atari den herri-iraultzaraino iritsi arte. Aliantza historiko honek, langile-klaseak hegemonizatutakoak, bere barnean nazio-kontzientzia duten herri-kapetako sektore zabalak hartu behar ditu. KASeko organizazioak klase-organizazioak dira, baina Herri Batasunak, gehiengoa izatera irits dadin, eta gure borroka-moten elkarren arteko erlazioetan oinarrituz prozesuaren garaipenera eraman gaitzan, zabalagoa izan behar du, eta autodeterminazioa bilatzen duten gure herriko herritar kapez hornitu.

Gaur egun gure herri honetan bizitzen ari garen zirkunstantzia eta kondizio subjetiboen arabera, guztiz egokitzat jotzen da Herri Batasuna, nahiz eta orain baino organizatuagoa, baina ez zerbait itxi edota exklusibista izatea. Hau da, erreferentzia-polo soil izatea baztertuz, berarengandik hurbilen aurkitzen diren inguruekiko paper hau jokatzea garrantzitsua dela uste dugu, ingurune horiek geureganatuz joateko. Organizazio-experientzia asko eta asko guztiz galgarri izan dira gure herrian. HBren experientziak organizazioarekiko mesfidantza edota etsipena duten sektore asko bereganatzen ditu; eta baitere, zergatik uka, gaur gaurkoz militantziaren konpromezuak gure gaurko prozesu honetan suposatzen duen arriskua jasateko gauza ez diren sektoreak. Hots, HBk prozesu honetan betetzea dagokion funtzioari egokitzen zaion organizazio-maila eduki behar du; eta aldi berean organizazio-maila hau ere oraindik onartzen ez duten baina denborarekin eta kontzientzi maila gehitzearekin asumitzera iritsiko diren bere influentziapeko sektoreentzat erreferentzia-polo edo gune izaten jarraitu behar du.

Honela beraz, egitura-mailara lotuz, arazoa ez da HBn lehendik daudenez gain beste organu berriak asmatzea; baizik eta bere kideen arteko loturak, konpromezua eta aktibismoa areagotu eta sendotuko duen barne-dinamika berarizkoa ematea, eta halaber, bere sektorerik atzeratuenetan kontzientzi maila altxatzea. Hots, Herri Batasunan iharduera politiko etengabeko linea desarroilatu behar dela uste dugu. Iharduketa planifikatua, norabideak markatuko dituena, eta aldi berean bere praktika deszentralizatuaren experientziak integratu eta zabalduko dituena. Bere iharduera-eremu berarizkoena masa-borroka da, eta udal-mailako erakundetako borroka. Bere presentzia gehiago nabarmendu behar da auzoetan eta herrietan, eta baitere lantegietan. Laburtuz, orain-oraingo lana efizienteagoak izatea da, hots, gure organizazio-egiturak hobeto erabiltzea, herritar batasunaren politika-iharduketa nabarmenagoa, jarraituagoa, integratuagoa izan dadin.

Gorago aipatu ditugun linea horietan, KASeko organizazioetatik etengabe eskuhartze-egitasmoak eraman behar ditugu Herri Batasunara, ez erakunde-mailako borrokarako bakarrik, baizik eta masen borrokaren eremu osoan ere bai, hots, herritar mugimenduan eta langile-mugimenduan, programak eta alternatibak planteiatuz arazo orokorrei buruzko auzietan; baina baitere, eta hau oso garrantzitsua da, herriko arazoei buruz.

Horretarako Blokeko organizazio politikoetatik Herri Batasuneko komite lokaletan partehartu behar da eta hauek organizatzen ahalegindu; baina inolako asmo dirigistarik edo sustituistarik gabe, baizik eta dinamizatzaile bezala. Prozesuaren egoera honetan, Blokeko organizazioen gain ematen den errepresioagatik, organizaziorik zabalena eta toleratuena adierazpen publikorik zabalena duen plataforma da eta izan ere izan behar du. Plataforma honetan eta beronen bidez azaltzen dugu gure gaitasun politikoa; eta horregatik bertan buru-belarri sartu eta jokatu behar dugu.

PONENCIA DE LINEA POLITICA

INDICE

*6) ESTATU EZ–ALINEATUEN MUGIMENDUA.*

Estatu Ez-Alineatuen Mugimenduak arreta berezia merezi du, gero eta garrantzi haundiagoa erdiesten ari bait da, nola koalitatiboki, hala kantitatez. Herri-multzo haundi bat biltzen du, ia gehienak desarroilo-bidetan doazenak, baina poliki-poliki munduko nazioarteko harremanetan gero eta leku gailenagoa lortzen ari direnak.

Sortu zenetik, Herri hauetako Estatu-Buruen edo Gobernu-Buruen zazpi Gailur-konferentzia egin dira. Herri ez-Alineatuak Belgradon (61.ean), Kairon (64.ean), Lusakan (70.ean), Argelen (73.ean), Kolonbon (76ean) La Habana (79.ean) eta Nueva Delhi (83.ean) bildu dira. Bere Hazkuntza harrigarria izan da, Belgradon bildu ziren 25etatik, Kolonboko 85etara, eta La Habana ONU osatzen duten Herrien 100eko 60 elkartzen direlarik, Nueva Delhiko partaideak gehituz. Kideen kopuruak eta berauen heterogeneitateak arazo ezberdinen aurrean Herri bakoitzak duen jarrera ezberdina nolabait baldintzapetu egiten du; izan ere erregimen politiko desberdinak bait dituzte, desarroilo ekonomikoko maila desberdinak eta inperislismoarekiko dependentzia-maila eta gradu desberdinak ere. Elementu politiko, ekonomiko, sozial eta kulturalen barietatea nabaria da; hain zuzen, besterik beste Herri hauek biltzen bait dira: Algeria, India, Jordania, Kuwait, Libia, Panama, Vietnam, Jugoslabia, Argentina, Cuba, Marruekos, Peru, etab.

Desberdintasun hauez gaindik ere, zenbait arazo oinarrizkoetako lorpenak nabariak izan dira eta garrantzizko adostasunak lortu ahal izan dira; batez ere beren joera nagusiki antiinperialistatik eratorri auzietan eta nazio-independentziaren aldeko arazoetan. Hasera-haseratik eta bere lehen deklarapenean seinalatzen zen mundua transizio-epe batetan aurkitzen dela, dominaziozko oreka iragan batetik nazioen elkarren arteko kooperazioan oinarrituriko geroko oreka baten arteko transizio—epean; eta horretarako bake-bidetik jarraitzea behar-beharrezkoa dela, zeina inperialismo kolonialista eta neokolonialista ezabatuz bakar-bakarrik lor bait daiteke. Bere Hirugarren Gailurreko Konferentzian, oraindik gehiago zehaztu ziren jarrera orokorrak, Herrien beren subirania errespetatua izan dadin duten eskubidea, Herrien desarroilo ekonomikoan sartzeko eta partehartzeko duten eskubidea etab. etab. azpimarratuz.

Konferentzia guztien eta bakoitzaren barrena, kolonialismoari eta neokolonialismoari buruz zentzu antiinperialista duten proposamen eta ebazpenak onartu izan dira, arrazismoari buruz, apartheida eta sionismoari buruz, Palestinako auziaz, Namibiako arazoaz, Puerto

*6) EL MOVIMIENTO DE PAISES NO ALINEADOS*

Especial mención requiere el fenómeno del Movimiento de Paises No Alineados, por su creciente importancia, tanto cualitativa, como cuantitativa. Representa un amplio conjunto de paises, en su mayoría en vías de desarrollo, pero que progresivamente están alcanzando un lugar destacado en las relaciones internacionales mundiales.

Desde su creación, han tenido lugar siete conferencias-Cumbre de los Jefes de Estado o de Gobierno de los Paises No Alineados, en Belgrado (en el 61), El Cairo (64), Lusaka (70), Argel (73), Colombo (76), La Habana (79), y Nueva Delhi (83). Su crecimiento ha sido espectacular, desde los veinticinco paises asistentes a Belgrado, a los ochenta y cinco de Colombo, siendo en La Habana el 60 por ciento de los paises componentes de la ONU, y ampliándose el número de asistentes a Nueva Delhi. Su número de componentes y su heterogeneidad condiciona la actitud diferente que sus paises tienen ante diversos problemas, no en vano tiene diferentes regímenes políticos, distintos niveles de desarrollo económico y distintos grados de dependencia del imperialismo. La variedad de los elementos políticos, económicos, sociales y culturales es manifiesta, pues, entre otros paises, se cuenta a Argelia, India, Jordania, Kuwait, Libia, Panamá, Vietnam, Yugoslavia, Argentina, Cuba, Marruecos, Peru, etc.

A pesar de esta diversidad, los logros en ciertas cuestiones claves han sido patentes y se han conseguido acuerdos de importancia, básicamente en los derivados de su mayoritaria orientación antiimperialista y en favor de la independencia nacional. Ya desde sus inicios y en la Primera Declaración se señalaba que el mundo se encontraba en un período de transición entre un pasado equilibrio en base a la dominación y un futuro equilbrio en base a la cooperación entre las naciones, para lo cual era necesario avanzar hacia la paz que sólo es posible con la eliminación del imperialismo colonialista y del neocolonialismo. En su Tercera Conferencia Cumbre, se matizó aún más en las posiciones globales, expresándose el derecho de los pueblos al respeto de su soberanía, el derecho de los pueblos a entrar en el desarrollo económico, el derecho de los pueblos a participar en las cuestiones principales de las relaciones internacionales, etc.

A lo largo de todas y cada una de las Conferencias se han aprobado propuestas y resoluciones de signo anti-imperialista respecto al colonialismo y neocolonialismo, el racismo, el apartheid y el sionismo, la cuestión de Palestina, el problema de Namibia, el caso de Puer-

Ricoko kasuaz, Saharako prozesuaz, desarroilo ekonomikoari eta baliabide naturalen gaineko subiraniari buruz, arazo komertzialak eta monetarioak, Herri sozialisten arteko kooperazioa, desarmeaz etab. etab...

Estatu Ez-alineatuen Mugimenduaren existentziaren 20 urtetako balantzea osoki positiboa gertatu da, bertan bildu Herri gehienek lortu duten ahalegin-batzearen mailagatik, hain zuzen. Era berean, Herri sozialistekin duten gero eta gehiagokc kolaborazioagatik. Prozesu guzti honek munduko Herrien arteko harreman ekonomiko eta politikoetan aldakuntza errotikakoak, gero eta bizkorrago, eraman ahal daitezen eragin haundia izan du. Eta halaber, Estatu Ez-Alineatuek suposatzen duten indarrak, orohar bloke inperialistaren eraginaren ahultzea eta beronen organizazio politiko eta militarren beherakada adierazten du.

Ondorioz, beraz, inperialismoa zentzu antiinperialista duen ez-alineazioko joera desitxutatzen saiatu da; eta ez-alineazio "garbiaren" teoria sartu nahian; honela Estatu Ez-Alineatuen Mugimenduak jarrera zail, ezinezko eta irreal bat har dezan inperialismoaren eta Herri sozialisten arteko erdi-bide bat, alegia. Baitere, zenbait Herri presionatu du ez-alineatuekin erlazionatzea edo hauekin bat egitea galeraziz. Estatu Ez-Alineatuen Mugimenduaren Deklarazioek, beren egitasmo eta ebazpenek —seinala beharrezko da—, orientazio antiinperialista hau ezinbestezkoa dutela, jarrera hau gabe ezinezkoa bait zaie beren posizionamenduak praktikan jartzea.

to Rico, el proceso del Sahara, el tema del desarrollo económico y la soberanía sobre los recursos naturales, problemas comerciales y monetarios, la cooperación con los paises socialistas, el desarme, etc.

El balance de 20 años de existencia del Movimiento de Paises no Alineados es altamente positivo por el nivel de unión de esfuerzos alcanzado por la mayoría de los paises adheridos. Igualmente, las cotas crecientes de colaboración con los paises socialistas. Todo este proceso ha incidido en que sea llevado a la práctica, cada vez con más pujanza, el planteamiento de cambios radicales en las relaciones políticas y económicas de los paises del mundo. De la misma manera, el potencial que supone el Movimiento de Paises No Alineados conlleva la pérdida de influencia y el debilitamiento del bloque imperialista en su conjunto y de sus organizaciones políticas y militares.

En consecuencia, el imperialismo ha tratado de desvirtuar el enfoque de la no alineación de orientación antiimperialista e imbuir la teoría de la no alienación "pura", de tal forma que el Movimiento de Paises No Alineados opte por una difícil e irreal posición de equidistancia entre el imperialismo y los paises socialistas. También ha presionado a distintos paises a fin de impedir su relación con los no alineados o a evitar su integración formal. Hay que señalar que las Declaraciones del Mov. de Paises No Alineados, sus programas y resoluciones, requieren de esa orientación antiimperialista, sin la cual es imposible llevar a la práctica tales posicionamientos.

## *7) MUNDUKO HERRIALDE EZBERDINEN ANALISIA.*

### *7.1.– Africa*

Afrikako kontinentea da munduko herrialdeen arteko Munduko Prozesu Iraultzaileak, azken hamarkadetan, aurrerapen nabarmenak izan dituena, Nazio-Askapenerako Mugimenduei dagokionez. Afrika izan da kolonia-kontinenterik berarizkoena; kolonia-sistema hau oso luzea izan bait da bertan, eta bestalde, arras sakonki errotua; kolonismoaren forma klasikoak ere bertan azaldu dira argiroen.

Egun esan dezakegu, kolonia-sistemaren ezabatzea egitate bat dela, eta fase post-kolonial bete-betean aurkitzen garela, independentzia lortu bide duten eta ezaugarri nagusi bezala desarroilo bidetan aurkitzen den beren egoera ekonomikoa duten Herri berri sail haundi batekin. Menpeko Herrien sailean genion bezala, Afrikan ere ematen da Herri hauen heterogeneitatea, iragan ezberdina izan

## *7) ANALISIS DE LAS DIFERENTES AREAS DEL MUNDO.*

### *7.1.- Africa*

El continente africano es la región mundial donde el avance del Proceso Revolucionario Mundial, en las últimas décadas, se ha destacado en lo que respecta a los Movimientos de Liberación Nacional. Africa ha sido el continente colonial por excelencia en razón de la duración del sistema colonial y la profundidad de su implantación, siendo donde más presentes han estado las formas clásicas de colonialismo.

Hoy se puede afirmar que la liquidación del sistema colonial es un hecho y que nos hallamos en una fase post-colonial, con toda una serie de paises que han alcanzado su independencia y que tienen como rasgo genérico su situación económica en vías de desarrollo. Según señalábamos en el apartado de los Paises Dependientes, en Africa también se da la heterogeneidad de estos paises, debido a su distinto pasado, a sus diferentes grados de depen-

bait dute, dependentzia ekonomiko eta politiko maila desberdinetakoa eta oraingo joera ere, sozialismorantz ala kapitalismorantz desberdina bait da.

Nahiz eta kolonialismoaren ezabatzeaz ihardun, oraindik ere dominazio-mota honen aztarnak aurki ditzakegu, dominazio inperialistaren forma berrien, hots, neokolonialismoaren ondoan.

Deskolonizazio-prozesu honetan hainbat eta hainbat faktorek hartu dute parte; besterik beste hauek azpimarra daitezkeelarik: Herri kolonizatuen borroka kolonialismotik eta inperialismotik askatzeko; Herri sozialistetan sozialismoa agertzea eta eraikitzea; II. Mundu-Gerran faszismoa garaitzea; Herri askatu berrien gero eta garrantzi haundiagoa, zeintzu kolonialismoaren esagertzea eskatu bait dute eta orientazio aurrerakor bat hartu; Herrien arteko nazioarteko harreman mota berrikoen eragina, mugimendu baterakorrak bultzatuz, esate baterako, Estatu Ez-Alineatuen Mugimendua edota Afrikar Batasunerako Organizazioa (OUA) eta berauen eragina ONUk hartzen dituen ebazpenetan.

Afrikan eman diren aldaketen balantzea aski baikorra da. Aldaketa hauek, batez ere, 50.eko hamarkadan gertatu dira, hamarkada honetan 6 estatuk lortzen dutelarik beren independentzia, eta 60 hamarkadan, 31 Estatu askatzen direlarik, eta 70.eko hamarkadan, 8 Estaturekin. Egun, kolonialismoaren kondarrak eta arrazista diren erregimenak Namibia eta HegoAfrikara mugatzen dira, Saharako kasua konponbidean aurkitzen delarik (arazo hau arabiar munduari dagokion atalean sartuko dugu).

Azken urteotan baikorki konpondu dira inperialismoaren eta kolonialismoaren aurkako borroka antikolonialistak; eta Estatu kolonialisten aurkako borrokak, hala nola, Portugal, Espainiako Estatua, Bretainia Haundia, Frantziako Estatua, Italia, Mendebaleko Alemania, Belgika. Herri hauen askapena ikusi ahal izan dugu: Benin (lehen Dahomey), 72an, Kongoko Errepublika Herritarra, 73an, Ginea-Bissau, 74an, Mozanbike, Angola, Santo Tome eta Principe, Cabo Verdeko Irlak, 75an, Djibuti, 77an, Zinbabwe, 79an.

Hegoaldean HegoAfrikak jarraitzen du, inperialismoaren zaindariaren papera jokatzen duen Estatua, eta bere barne-politika apartheideko edo arraza-diskriminazioko erregimenean oinarritzen duena, eta maniobra sasi—aperturistak edo sasi—liberatzaileak bultzatuz, adibidez, bantustanak edo Estatu satelite bere babespekoak sortuz. Kanpokaldera, berriz, auzoko estatuak etengabe erazoz, bai berak zuzen-zuzenean, bai Herri hauetako erakunde antiiraultzaileak eta erreakzionarioen laguntzaz agresio-politika bat darama. Estatu honen iraupena Estatu inperialistetatik eta Israel bezalako, beste Estatu arrazistetatik jasotzen

dencia económica y política y a su diversa orientación hacia el socialismo o el capitalismo.

A pesar de que hablamos de liquidación del colonialismo, encontramos todavía restos de esta dominación, junto a nuevas formas de dominación imperialista, es decir, el neocolonialismo.

A este proceso de descolonización han contribuido múltiples factores, entre los que se puede detallar: la lucha de los pueblos colonizados por su liberación contra el colonialismo y el imperialismo; la aparición y construcción del socialismo en los paises socialistas; la derrota del fascismo en la II Guerra Mundial; la creciente importancia de los paises liberados, que han exigido la desaparición del colonialismo y que han tomado una orientación progresista; la influencia del nuevo tipo de relaciones internacionales entre los paises, con la potenciación de movimientos conjuntos como el Movimiento de Paises No Alineados o la Organización para la Unidad Africana (OUA) y su incidencia en las resoluciones adoptadas en la ONU.

El balance de cambios habidos en Africa es altamente positivo. Estos cambios van unidos básicamente a las décadas de los 50, con seis paises independizados en esos años. de los 50, con treinta y un paises, y de los 70, con ocho paises. Hoy, los restos de colonialismo y de presencia de regímenes racistas se reducen a Namibia y Rep. Sudafricana, hallándose en Vías de solución el caso saharaui, que lo incluimos en la problemática del mundo árabe.

Durante los últimos años se han resuelto satisfactoriamente las luchas anticolonialistas contra el imperialismo y los paises colonizadores, como Portugal, estado español, Gran Bretaña, estado francés, Italia, Alemania Occ. y Bélgica. Hemos asistido a la progresiva liberación de Benin (antes Dahomey), en el 72, Rep. Popular del Congo, en el 73, Guinea Bissau, en el 74, Mozambique, Angola, Santo Tomé y Principe e Islas de Cabo Verde, en el 75, Djibuti, en el 77, y Zimbabwe en el 79.

En el Africa Meridional continua la existencia de Sudáfrica, pais que juega en la zona el papel de gendarme del imperialismo y que basa su política interior en el régimen del apartheid o de la discriminación racial y en la potenciación de maniobras seudo-liberadoras, con la creación de "bantustanes" o estados satélites protegidos. A nivel exterior, marca su política con agresiones repetidas a sus estados vecinos directamente o con el concurso de las organizaciones contrarrevolucionarias y reaccionarias de estos paises. Su mantenimiento se debe al apoyo que recibe de los paises imperialistas y de otros regímenes racistas, como

duen laguntzan oinarritzen da. Bere aldetik, HegoAfrikako herriaren ordezkari den erakundea, ANC (Afrikan National Congress) borrokan jarraitzen da munduko erregimenik arrazistena desegiteko asmoz.

Era berean, HegoAfrikak Namibiako lurraldea okupatuz jarraitzen du, ez bakarrik Herri honen gain bere domeinuari eusteko, baizik eta, baitere, Angola eta Zanbia erasotzeko sarbide-base bat eduki ahal izateko, nazioarteko erakundeen erabaki guztiei entzun-gor eginez, hala nola ONUren erabakiari, Namibia gain ezarri agintea uzteko aginduz. SWAPOren borroka indartzen doa, Herri honen askatasunaren alde.

Afrikaren askatasunerako prozesua gertatzen den hein berean, inperialismoak dominazio eta dependentzia-forma berriak bilatzen dihardu, forma guzti hauen buru neokolonialismoa aurkitzen delarik, zeina kolonialismoaren jarraipen bat bait da. Herri askatuek beren desarroilorako aurkitzen dituzten mugagabeko oztopoak eta ezintasunak aprobetxatuz, neokolonialismoak, maila guztietan eta, nabarmenkiro eskuak sartzen ditu, hasi presio ekonomikoak egitetik, presio politikoak, eta baitere, presio militarrak; mota guztietako presioak, alegia. Inperialismoak iharduera hauetan, lehen gaien bere beharrak asetzeko, produkzioko eta salmentako merkatuak lortzeko, armamentu zaharkitua sartzeko, etab. etabarretarako ahalegin guztiak egiten ditu. Are gehiago, Herrien arteko lekuko gatazkak sortuz, hauentzat ondorio kaltegarriak baino ez dakartzaten borroka ezezkorrak, alegia. Era honetan jokatzen du inperialismoak Afrikan, kontinente honetako zenbait eremu ezberdin bere interesetarako guztiz estrategikotzat edo lehen mailako interesduntzat hartuz; eta bertan aldaketa politikoak bultzatuz, joera pro-inperialistak eta erreakzionarioak aupatuz, hala nola Sudanen, Senegalen, Zairen etab. etab. . .

Prozesu deskolonizatzaile honetan aparteko balioa izan du Afrikako Estatu gehienak biltzen dituen erakundeak, OUAk, zeina izan bait da askapen nazionaleko borroken arrakastaren berme nagusia, "OUAren Askapenerako Batzorde" izeneko erakunde baten bidez, zeinak nazio-askapenerako mugimenduei bere laguntza eskeini bait die, eta gatazka eta arazoetan hauek aztertu eta erabakiak eta neurriak hartu bait ditu; Batzorde hau da, bestalde, OUAren ebazpenak elaboratzen dituena. Egun, OUA iadanik lortuak izan diren konkistei eusteko berme da, nahiz eta bere baitan zenbait joera erreakzionario nabaritu.

Munduko Prozesu Iraultzailearen aurrerapenerako ekarpen txit baliozkoa da Afrikako sozialista joerako desarroilo bidetan aurkitzen diren Estatuen indartzea zeintzu, askatuak izan eta gero, nazio-askapen horretatik eratortzen diren egitekoei heltzen bait die. Bar-

Israel. Por su parte, la organización representativa del pueblo sudafricano, el ANC (African National Congress), continua su combate por el derrocamiento del régimen más racista del mundo.

Igualmente, Sudáfrica continua con la ocupación del territorio de Namibia, no solo para mantener su dominio sobre este pais, sino también para contar con una base de entrada para sus agresiones contra Angola y Zambia, desoyendo todos los acuerdos de organamismos internacionales, entre ellos la ONU, de prescripción de su mandato sobre Namibia. La SWAPO acrecienta su lucha de liberación de su pais.

A la vez que se da el proceso de liberación en Africa, el imperialismo busca crear nuevas formas de dominación y dependencia, a la cabeza de las cuales se halla el neo-colonialismo, que viene a ser una continuación del colonialismo. Aprovechando las dificultades extensas que los paises liberados tienen para su desarrollo, el neocolonialismo penetra con una marcada actitud de ingerncia a todos los niveles, desde presiones económicas, a presiones políticas, e, incluso militares, de diverso signo. El imperialismo emplea cuantiosos esfuerzos en estas actividades para dar cumplimiento a sus necesidades de materias primas, demercados de producción y venta, de colocación de armamento atrasado, etc. Inclusive creando conflictos zonales entre paises, para los que ello sólo acarrea consecuencias negativas. Juega de la misma manera, el imperialismo en Africa, cconsiderando diversas áreas de este continente como estratégicas o de interés prioritario para sus intereses, donde impulsa cambios políticos, aupando a tendencias pro-imperialistas y reaccionarias, como en Sudan, Senegal, Zaire, etc.

Especial valor ha tenido en el proceso descolonizador el organismo que agrupa a la mayoría de los paises africanos, la OUA, que ha sido la garantía de éxito para las luchas de liberación nacional, dotándose de una institución denominada "Comité de Liberación de la OUA", que ha prestado su apoyo a los movimientos de liberación y ha estudiado y tomado medidas en los conflictos, siendo además quien elabora las resoluciones de la OUA. Hoy la OUA es garante del mantenimiento de los logros ya conseguidos, a pesar de ciertas tendencias de índole reaccionario en su seno.

Para el avance del Proceso Revolucionario Mundial, es una aportación destacadísima el fortalecimiento de los paises africanos en vías de desarrollo de orientación socialista, que, tras su liberación nacional, acomenten las tareas derivadas de ésta. En el plano interno, potenciando su soberanía nacional y el desarro-

neko mailan, beren nazio-subirania sendotuz, eta desarroilo ekonomikoa eta soziala bultzatuz eta aldakuntza sustraikoetan sakonduz; kanpo-mailan, berriz, nazioarteko harreman politiko eta ekonomikoen egituratze berri baten alde lan eginez. Egoera honetan aurkitzen dira: Angola, MozanLike, Etiopia, Kongoko Errepublika Herritarra, Ginea-Bissau, Madagaskar, Benin, Cabo Verde eta Seychelles.

Indar iraultzaileen artean gailendu beharreko alderdi bat sozialista joerako zenbait herritan gertatzen diren hainbat egoera berezi dira, hala nola Etiopiaren eta Eritrearen kasuan. Neurri haundi batetan, kolonialismoak sortu egoeren ondorio, adibidez, mugen zatiketa eta banaketa arras artifizial eta zentzugabekoa eta honen ondorioz Herrien zatiketa. Eta guztionek, baitere, indar iraultzaileen bainan kontraizanak, barneko kontraizanak azeleratzen ditu, kontraizan guzti hauen tratamendu egoki batez konpondu behar dira, erreakzioak bere alde eta probetxurako manipula eta erabil ez ditzan.

Askenik, Kanariak Irlen kasua aipatu behar dugu, zeren argi eta garbi Afrikako kontinentera pertenezitzen bait dute, ez arrazoin geografikoengatik bakarrik, baitere, arrazoin ekonomiko, historiko, sozial eta kulturalengatik. Kanariar Herria nazionaliki eta sozialki Espainiako Estatuak zapaldua aurkitzen da, Estatuko beste Herri guztiak bezala. Kanarien konkista XV. mendean datatzen da, eta data honetatik gaurdaino dependentzia gogor bat jasan behar izan du, maila guztietakoa, Espainiako Estatuaren menpean. Egoeren arabera mekanismoak aldatuz, neokolonialismoa finkatzen joan zen egungo izaera honetaraino iritsi arte; hots, bere ba!iabide naturalen hustiapen basatian eta turismo-muntaian oinarritutako kolonialismo-mota berri hau 60ko hamarkadan hasten da, eta guzti honek ondorio arras kaltegarriak izan ditu Kanariar Herriarentzat. Alderdi guzti hauen alboan beste zera hau ere aurkitzen da: Inperialismoak Kanariar Irlak dominatzeko duen aparteko interesa, alegia, hots, bere plan militaristetarako duen balio haundiagatik, hain zuzen; eta, konkretuki, Afrikako kontinenterantz begira. Espainiako Estatuaren eta Estatu Batuen arteko Aldebiko Hitzarmenak Kanariak honela zehazten ditu: "Interes komuneko area geografiko bezala"; eta Espainiako Estatua Inperialismoaren bloque militarrean, OTANen sartzeaz, erasotarako bere plataformatako bat bihurtuko du, Arinagako base aeronabal projektuaren ingurutan konplexu haundi bat sortuz. Kanariak beraz, kolonialismoaren kondarretako bat dira, eta Afrikako nazio kolonizatu bat osatzen dute; horregatik honen deskolonizatzea bultzatu behar da, hainbat arinen, Kanariar Herriari autodeterminazio-eskubidea aitortuz eta independentzia konkistatzeko eskubidea ahalbidetuz.

llo económico y social y profundizando en radicales transformaciones; en el plano externo, trabajando por una estructuración de las relaciones políticas y económicas internacionales. En esta situación se encuentran Angola, Mozambique, Etiopia, Rep. Popular del Congo, Guinea Bissau, Madagascar, Benin, Cabo Verde y Sychelles.

Un aspecto a superar entre las fuerzas revolucionarias son algunas situaciones que se producen en paises de orientación socialista como es el caso de Etiopia y Eritrea. Producto en gran medida de situaciones provocadas por el colonialismo, como es el lineal y desastroso reparto de fronteras que consecuenta la división de los pueblos. Y conlleva, incluso, contradicciones internas entre fuerzas revolucionarias que deben ser resueltas con un tratamiento correcto, a fin de evitar su manipulación y aprovechamiento por la reacción.

Por último debemos tocar el tema de las Islas Canarias, por su clara pertenencia al Continente africano, no solo por razones geográficas, sino también por razones históricas, económicas, sociales y culturales. El Pueblo Canario está oprimido nacional y socialmente por el estado español, al igual que el resto de los pueblos del estado. La conquista de Canarias data del siglo XV, a partir de la cual ha sufrido una fuerte dependencia, en todos los ámbitos, del estado Español. Variando coyunturalmente los mecanismos, el colonialismo se fue implantando hasta tener las últimas directrices actuales, aparecidas en la década de los 60, de explotación salvaje de sus recursos naturales y de la creación del montaje turístico que ha causado consecuencias nefastas para Canarias. Junto a estos aspectos está el interés creciente del imperialismo por dominar las Islas Canarias por su alto valor estratégico para sus planes militaristas, en concreto, como punta de lanza hacia el continente africano. El Tratado Bilateral estado Español-EE.UU. califica a Canarias como "área geográfica de interés común", que con la entrada del estado español en el bloque militar imperialista, OTAN la convertirá en una de sus plataformas de agresión, con un vasto complejo alrededor de la proyectada base aeronaval de Aringa. Las Canarias son pues, uno de los restos del colonialismo y conforman una nación colonizada del contexto africano, por lo que debe desarrollarse un proceso de descolonización que prevea el derecho de autodeterminación y la conquista de la independencia por el pueblo canario.

## 7.2.– AMERIKA LATINDARRA

Gaur egun, Amerika Latindarraren egoera politikoa ezaugarri orokor batzuren bidez nabarmentzen da; ezaugarrion artean honako hauek azpimarra daitezke: inperialismoaren atzerakada, batez ere Erdialdeko Amerikan eta Caribe herrialdean; eta aldi berean, nazioaskapenerako mugimenduen aurrerapen guztiz garrantzitsuak, aipatu herrialde horretan garaipen bikainak lortu dituztelarik; Amerika Latindarreko kolonien azken kondarretan prozesu deskolonizatzailearen azken seinaleak; Amerika Latindarreko Estatuen egiteko gero eta garrantzitsuagoa munduko harreman ekonomiko eta politikoetan; zenbait Herritan, diktadura-erregimenekoak ere barne, aldaketa politikoen zantzuak.

60ko hamarkadaren 2. erdialdian bi prozesu arras desberdin planteiatuko dira, biak aparteko garrantzia izango dutenak. Alde batetik, periodo kontrairaultzaile baten hasera dakusagu, Brasilgo 64ko kolpe militarrarekin; eta bestaldetik, Cubako 59ko Iraultzaren garaipena.

Honela, beraz, aipatu dugun bezala, Brasilen hasten den atzerakako prozesua, eta Paraguayrekin batera, 70ko lehen erdialdian garatuko da. Amerikako hegoaldeko konoko diktadura militarrak heltzean: 71an Torresen gobernua botatzen dute, Bolivian; 73an, Chilen Batasun Herritarraren experientziak porrot egiten du, honela sozialismora bake-bidetik heltzea ezinezkoa dela frogatuz; urte honetan bertan ejerzitoak agintea hartzen du Uruguayn; eta 76an, kolpe militarrak Argentinari erasango dio. Aldi berean, eskubiratze gogor bat gertatuko da Perun, Mexikon , Ecuadorren, eta ZentroAmerikako diktadura-erregimenen iraupena: El Salvador, Haiti, Honduras, Nicaragua eta Guatemalan. Inperialismoak, bertako oligarkiekin eta sektore erreakzionarioekin batera, bere posiziotan iraungo du, eta aldi berean, kontraofensiba zabal eta irekiko, "Inperialismoaren Izaerari" buruzko sailean aipatzen genituen bideak erabiliz, bere expantzionismo ekonomikoa areagotuz, Amerika Latindarreko Estatuen dependentzia eta menpekotasuna gehituz, bere interesetarako aliatu berriak bilatuz eta bere arma-potentziala eta zerbitzu berezituak, guztien gaindi CIA, erabiliz. Era berean, Amerikako Estatuen Organizazioa (OEA) bezalako erakundetan eskua sartuz.

Diktaduraren ezarpenen fenomenoa aski interesgarria da. Monopolioen, finantzar oligarkien eta lekuko latifundisten interes baterakoiak desarroilatzeko, inolako oztopo edo mugapenik gabe, demokrazia-burgesak likidatzen eta ezabatzen dira; demokrazia, asko-gutxi, aurreratuak hauek; eta berauen ordez erregimen faszistak eraikitzen dira, hauen bi-

## *7.2.- América Latina*

En la actualidad, la situación política en América Latina se caracteriza por una serie de rasgos globales, entre los que se pueden destacar: el retroceso del imperialismo, especialmente del área centroamericana y del Caribe; a la vez, avances significativos de los movimientos de liberación nacional, con victorias en la misma área; los finales del proceso descolonizador en los restos coloniales en Latinoamérica; el crecimiento del papel de los paises latinoamericanos en las relaciones políticas y económicas del planeta; e indicios de cambios políticos en diferentes paises, incluidos los del régimen dictatorial.

En la segunda mitad de la década de los 60 se van a plantear dos procesos muy diferentes, pero de gran trascendencia. Por un lado, asistimos al inicio de un período contrarrevolucionario, con el golpe militar del 64 en Brasil; por otro lado, al triunfo de la Revolución Cubana, en el 59.

Así pues, el proceso de retroceso, iniciado, como hemos señalado, en Brasil, junto a Paraguay, se va a culminar en la primera mitad de los 70 con el advenimiento de las dictaduras militares en el Cono Suramericano: en el 71 es derrocado el gobierno de Torres en Bolivia; en el 73, se frustra en Chile, la experiencia de la Unidad Popular; demostrándose la imposibilidad de acceso al socialismo por vía pacífica; éste mismo año, el ejército toma el poder en Uruguay y en el 76, el golpe militar afectará a la Argentina. Simultáneamente, se producirá una derechización en Perú, Mexico, Ecuador, y el mantenimiento de los regímenes dictatoriales en Centroamérica: El Salvador, Haiti, Honduras, Nicaragua y Guatemala. El imperialismo, en conjunción con las oligarquías y los sectores reaccionarios locales, mantenía sus posiciones, a la par que abría una intensa contraofensiva, utilizando los medios que señalamos en el apartado "Carácter del Imperialismo", incidiendo en su expansionismo económico, en el aumento de la dependencia de los paises latinoamericanos, buscando nuevos aliados políticos para sus intereses y empleando su potencial militar y servicios especializados, con lugar destacado para la CIA. De la misma manera, maniobrando en instituciones tipo la Organización de Estados Americanos - OEA.

El fenómeno de implantación de las dictaduras es bien interesante. Para el desarrollo de los intereses comunes de los monopolios, oligarquías financieras y latifundistas locales, sin ningún tipo de traba o limitación se liquidan las democracias-burguesas, más o menos avanzadas, en favor de la instauración de un régi-

dez planteiaturiko projektuak samurrago bideratu ahal izateko. Erregimen hauek nazioko ejerzitoetan eta Estatu-aparailu gogor bat eraikitzean oinarrituko dira.

Prozesu honetan faktore ezberdin ugariak hartuko du parte; faktore hauek Herri batetik bestera desberdinak izango dira, bakoitzaren baldintzen arabera; baina, orohar, hauexek dira: krisi ekonomikoak, botereko taldeen artean desarroilo ekonomikoari buruzko barnekontraizanak garatzen direlarik; burgesia ttipiaren eta erdi-mailakoaren haserrea, batez ere beren sektore erreakzionarioena; mugimendu iraultzailearen ezintasun, hutsune eta ez-gaitasunak, barneko krisiak sortzen direlarik edota prozesuak gidatzerakoan akatsak nabarmentzen.

70.eko hamarkadaren azkenaldera eta 80koaren hastapenetan, diktadurak barne-krisiko epe batetan sartzen dira, neurri haundi batetan beren izaera behinbehinekoarengatik: beren egitekoa ekonomia-aldaketa batzuri ekitea eta taiu honetako erregimenik gabe arrunt zaila zatekeen egitura-transformazio batzu burutzea zen. Eta aldi berean, alderdiak, sindikatuak, eta masa-antolamenduak, bereziki ezkerrekoak gutxiestea, beren ahalgarritasuna eta eragina murrizteko. Erizpide ekonomiko eta sozialetan barne-kontraizanak agertzen hasten dira. Aldi berean, zenbait sektore erregimenarengandik aldentzen doaz, hala nola burgesia ez-monopolista eta ejerzitoko eta Elizaren hainbat sektore. Une honetan ekiten zaio erregimen militaristen instituzionalizazio edo birregokitze deitu prozesuari, konstituzio berriak, antidemokratikoak, onartuz, Chilen bezala, kanpora begira legeztapen, zilegitasun politiko bat bilatuz. Estatu batzutan, maniobra hauetarako, alderdikontserbadoreen laguntza aurkitzen da, nahiz eta hauek gobernu militarrekiko, formalki bederen, aurrez-aurre enfrentatuta aurkitu, baina, baitere, diktadura hauei irtenbide eta konponbide erreformistak beregain hartzeko prest aurkitzen direnak, edota boterean partaide izateko prest daudenak. Herri hauetako mugimendu iraultzaileei planteiatzen zaien arazoa zera da: sortzen diren egoera ezberdin anitzi zuzenki heldu beharra, diktadura hankaz-gora botatzeko indarrak batu eta elkartzeko ahaleginetan; eta bestalde, berriz, garrantzizko aldakuntzak aurrikusiko dituen egitarau politiko demokratiko-iraultzaile bat eskaintzeko gaitasuna; eta azkenik, aldi bakoitzean, borroka-mota ezberdinak erabiltzea eta erlazionatzea.

50ko hamarkadaren azkenetako eta 60koaren haseratako beste prozesu-giltzarri bat —lehenago aipatzen genuen bezala— Cubako Iraultza da. Izugarrizko gertakizun historikoa izango da hauxe, Amerikako kontinentearentzat aro berri bat irekiko duena: izan ere Cuba bezalako Estatu sozialista baten existentziak mugimendu antiinperialistari bultzada inolaz

men fascista, donde se puedan reconducir los proyectos planteados. Estos regímenes se van a apoyar en los ejércitos nacionales y en la creación de un férreo aparato de estado.

A este proceso son variados los factores que van a contribuir, que varian de un pais a otro, según condiciones, pero que, de forma común van a ser: las crísis económicas, con el agravamiento de las contradicciones internas respecto al desarrollo económico entre los grupos del poder; el descontento de la pequeña y mediana burguesía, sobre todo de sus sectores reaccionarios; las deficiencias e incapacidades del movimiento revolucionario, con el surgimiento de crísis internas o errores en la conducción de los procesos.

A finales de la década de los 70 e inicios de la de los 80, las dictaduras entran en un período de crísis internas, en gran medida debido a su propia naturaleza provisional: su misión ha sido el abordar una serie de cambios de la economía y modificar estructuras que sin un régimen de tal cuño era difíficl. Paralelamente, minimizar a los partidos, sindicatos y organizaciones de masas, fundamentalmente de la izquierda, con el fin de recortar su potencialidad e incidencia. Aparecen contradicciones internas en los criterios económicos y sociales. Al mismo tiempo hay sectores que se alejan del régimen, como la burguesía no monopolista y sectores del ejército e iglesia. Es el momento en que se aborda la denominada institucionalización o readaptación de los regímenes militares, que incluyen hasta la aprobación de nuevas constituciones, antidemocráticas, como en Chile, buscando una legitimación política de cara al exterior. En algunos paises contamos con el concurso, para tales maniobras, de partidos conservadores, a veces formalmente enfrentados a los gobiernos militares, pero dispuestos a asumir las salidas reformistas para las dictaduras, o dispuestos a compartir el poder. El problema planteado para los movimientos revolucionarios de estos paises es la necesidad de abordar con corrección la variedad de situaciones creadas, en el camino de unir y aglutinar fuerzas para el derrocamiento de la dictadura y la capacidad de ofrecer un programa político-revolucionario que prevea transformaciones importantes y, por último, la utilización y combinación de las diferentes formas de lucha en cada fase.

El otro proceso que exponíamos como clave a finales de la década de los 50 e inicios de los 60 es la Revolución Cubana. Va a ser un auténtico acontecimiento histórico, que abrirá para el continente americano una nueva época en la que la existencia de la Cuba socialista va a dar una fuerza imparable al movimiento anti-imperialista. Colocándose Cuba a

geraezina emango bait dio. Cuba Amerika Latindarreko aldaketa ekonomiko, sozial eta politikoen aitzindari jarriko da. Cubako Herriak, eta beronen abangoardiako organizazioak, Cubako Alderdi Komunistak, arrakasta izugarriz, orainarte lortu konkistei iraunarazteko eta sozialismoa eraikitzeko langintzari ekin dio, eta aldi berean, inperialismoaren erasoei erantzuten jakin duelarik. Cubako iraultza-prozesuaren beste alderditako bat, alderdi garrantzizkoa gainera, borrokan diharduten beste Herriekiko solidaritate internazionalistazko praktika izan da eta da; desarroilo-bidetan dauden Herriek nazioarteko harremanetan duten eragin gero eta nagusiagoan erasan nabarmena izan duelarik, eta baitere Estatu Ez-Alineatuen Mugimenduaren antzeko erakundetan; erakunde honen azkenaurreko Gailurreko Biltzarrea, hain zuzen, La Habanan ospatu zelarik.

80ko hamarkadan, Amerika Latindarreko mugimendu iraultzaileen gorakada garbia dakusagu, ZentroAmerikan eta Cariben aurrerapen koalitatiboak ematen direlarik. Aldaketa positiboak, nahiz eta urriak, ematen dira Brasilen, Ecuadorren, Colombian, Bolivian, Granadan, Guyanan eta Surinamen prozesuak sendotu egiten dira; mugimendu iraultzailea, bai eraginez eta bai efikaziaz hazi egiten da Guatemalan; Chileko diktaduraren aurkako erasoak ugaldu egiten dira, indar iraultzaileek bat egiten dutelarik, eta borroka-mota ezberdinak erabiltzen dituztelarik; eta era berean, Hegoaldeko konoko beste erregimen militarren kontra ere (Uruguayn, Argentinan).

Nicaraguako iraultzaren garaipen berria trinkotzen ari da, langilegoak, FSLNaren ondoan, borroka egin eta gero, borroka armatuaren eta masa-borrokaren arteko konbinazio-estrategia egoki bat erabili ondoren. 79ko Uztailetik iragan denbora nahikoa izan da maila guztietako aldakuntzei ekiteko eta Herria birreraikitzeko langintzak pauso funtzezkoak emateko; eta aldi berean, erasoka eta interbentzio-mehatxuka ari zaion inperialismoari Nicaraguako Herriak lortu dituen konkistak eta aurrera begira espero dituenak ere defenditzeko erabat eta oso-osorik prest dagoela erakutsiz.

Nazio-askapenerako mugimenduarentzat oinarri-oinarrizko da, gaur egun, El Salvadorren erregimen diktatorialaren aurka eramaten ari den borroka, Salvadorreko Herriak eta bere abangoardiako erakundeak, FDR eta FMLN-k daramaten borroka politiko-militarra, alegia. Erregimen diktatoriala praktikoki frakasatua aurkitzen da, nahiz eta inperialismoaren laguntzarekin kontatu, Estatu Batuen laguntza ekonomikoa eta OEAren jarrera erreakzionarioak berarekin izan. Salvadorreko prozesu iraultzailea, une honetan, Amerika Latindarreko aurreratuena da, barnean bere efikazia gehituz doa eta kanporantz, laguntza politikoa,

la cabeza de las transformaciones económicas, sociales y políticas en Latinoamérica. El pueblo Cubano y su organización de vanguardia, el Partido Comunista Cubano, han emprendido con éxito las tareas del mantenimiento de las conquistas alcanzadas y de construcción del socialismo, sabiendo, simultáneamente, responder a las agresiones imperialistas. Otro aspecto destacado del proceso revolucionario cubano ha sido y es su práctica solidaridad internacionalista con los demás pueblos en lucha, habiendo tenido un papel decisivo en la creciente influencia de los paises en desarrollo en las relaciones internacionales y en organismos como el Movimiento de Paises No Alineados, cuya anteúltima Cumbre se celebró, precisamente, en La Habana.

Con la década de los 80 se aprecia un claro ascenso del movimiento revolucionario en Latinoamérica, con avnces cualitativos en Centroamérica y el Caribe. Hay cambios, aunque parciales, positivos en Brasil y Ecuador, Colombia y Bolivia; se fortalecen en Granada, Guyana y Surinam; el movimiento revolucionario gana en incidencia y eficacia en Guatemala; aumenta la ofensiva contra la dictadura chilena, con el aglutinamiento de las fuerzas revolucionarias y el empleo de diversas formas de lucha, al igual que contra el resto de regímenes militares del Cono Sur (Uruguay y Argentina).

El reciente triunfo de la revolución nicaragüense se consolida, tras la lucha del proletariado en torno al FSLN, con el empleo de una adecuada estrategia de combinación de la lucha armada y de masas. El tiempo transcurrido desde julio del 79 ha sido suficiente para el inicio de transformaciones a todos los niveles y para dar pasos decisivos en la reconstrucción del pais, así como para mostrar al imperalismo con sus agresiones y amenazas intervencionistas, la inequívoca decisión del pueblo nicaragüense de defender los logros conseguidos y los previsibles.

Punto vital hoy para el movimiento de liberación es la lucha que se desarrolla en El Salvador contra el régimen dictatorial, en base a la ofensiva político - militar del pueblo salvadoreño y sus organizaciones de vanguardia, el FDR y el FMLN. El Régimen está practicamente fracasado, a pesar de contar con el apoyo del imperialismo, de la ayuda económica y militar de los EE.UU. y de las posiciones reaccionarias de la OEA. El proceso revolucionario salvadoreño es, en el presente momento, el más avanzado en Latinoamérica, aumentando su eficacia en el interior y cre-

diplomatikoa eta solidarioa ere bai eta guztionek, laster irabaziko duen itsaropen argia eskeintzen digu.

*7.3.– ASIA*

Beste kontinente guztietan bezala, Asiak ere, XX. mendean barrena, aldaketa eta zalapartada-multzo bat jasan du; lehenago aipatu dugun bezala, kolonialismoaren, neokolonialismoaren eta inperialismoaren dominazio-egarrien eta menpeko Herrien nazio-askapenerako mugimenduen beren subiraniaren aldeko borroken artean sortu den dinamikak eragin-da. Azken hamarkadaren, enfrentamendua, batez ere, garrantzi estrategiko haundiagoa duten herrialde edo eremutan kokatu da; konkretuki, Afganistanen, bere kokaera geografiko bereziagatik, Asiako Hegoekialdean, Indotxinako peninsulan, eta ozeano Indiko eta Pazifikoko zenbait puntu ezberdinetan.

Iraultzaren aurrerapenen aurrez-aurre, Inperialismoak bere estrategiak behin eta berriro egokitu eta aldatu beharra izan du, galdu ondoreneko indarren koerlaziora doitzeko asmoz; Vietnamgo kasuan bezala, zeinak mundu-mailan izugarrizko arrakasta izan bait zuen: desarroilo-bidetan dagoen Herri batetako nazio-askapenerako ejerzitoak munduko lehen potentzia inperialistari, Estatu Batuei irabazteko posibilitatea ba dagoela frogatu ahal izan zen.

70ko hamarkadako aipagarriena Asiako hegoekialdeko zona zabal batetan inperialismoak atzerakada egitea izan da; atzerakada hau Vietnam, Kanputxea eta Laosko nazio-askapenerako mugimenduen garaipenetan konkretatzen delarik. Eta baitere, garaipenaren ondotik, Herri hauetan aldakuntzei ekitea eta sozialismoa eraikitzeko joera agertzea; eta halaber, Vietnamek bere lurraldearen integritatea definitzeko eraman borroka, Txinak bere kontra egin erasoen aurka altxatuz.

Aurreko guzti hauez gaindik, beste Herri batzuk ere sozialismoaren bidea jarraitzen dute, hala nola, Mongolia, Koreako Herri Errepublika Demokratikoa eta Afganistanek. Azken Herri honen kasua berezia da, zinez, bere egoeran azaltzen diren zirkunstantziengatik, hain zuzen. Izan ere, 78an erregimen monarkiko-feudala abolitu ondoren, Herriaren desarroilo ekonomikorako langintzei ekin zitzaien, nekazaritzaren erreformatik hasita; baina erreforma honen aurka klase latifundistak, klero erreakzionarioa eta lukurreroak altxatu ziren, beren interesen aurka bait ziren erreforma hauek. Planak burutzerakoan akats batzu ere egin, bide, ziren; hala nola, alderdiko koadroak mekanikoki hiritik landara aldatzea; eta bestalde, abangoardian inperialismo joerak sartzea; guztionek Herria, gerora begira, egoera zail eta larri batetara eraman zuen; izan ere,

ciendo el apoyo político, diplomático y solidario en el exterior, lo que corrobora las abiertas espectativas de un pronto triunfo.

*7.3.- Asia*

Al igual que el resto de continentes, Asia ha sufrido, a lo largo del siglo XX, toda una serie de cambios y convulsiones provocadas por la dinámica, que ya hemos expresado, entre las ansias de dominación del colonialismo, neocolonialismo e imperialismo y la lucha de los paises dependientes y movimientos de liberación nacional por su soberanía. En las últimas décadas, el enfrentamiento se ha centrado de forma notable en las áreas de mayor importancia estratégica, concretamente en Afganistán, por su posición geográfica, en el Sudeste asiatico, con la península de Indochina, y en puntos del oceano Indico y Pacífico.

Junto a los avances revolucionarios se han producido repetidas readecuaciones de la estrategia imperialista, con el objeto de adecuarse a las nuevas correlaciones de fuerza tras sus derrotas, que, como la de Vietnam, tuvieron un fuerte impacto mundial: se demostró las posibilidades reales de triunfo de un ejército de liberación nacional de un pais en vías de desarrollo, sobre las fuerzas de la primera potencia imperialista, los EE.UU.

Lo más destacable en la década de los 70 ha sido el retroceso del imperialismo en una amplia zona del sudeste asiático, concretado en los triunfos de los movimientos de liberación nacional en Vietnam, Kampuchea y Laos. El posterior inicio de transformaciones en estos paises y su orientación hacia la construcción del socialismo, con la defensa de la integridad territorial vietnamita ante las agresiones realizadas por China.

Además de los anteriores, otros paises siguen la vía socialista, como son Mongolia, R. P.D. Corea y Afganistán. El caso de éste ultimo pais es bien peculiar, por las circunstancias que confluyen en su situación. Así, tras la abolición del régimen monárquico-feudal, en el 78, se emprendieron las tareas del desarrollo económico del pais a partir de la reforma agraria, que chocó frontalmente con los intereses de las clases latifundistas, el clero reaccionario y los usureros. Algunos errores en la ejecución de los planes como fué el trasplante mecánico de cuadros del partido desde las áreas urbanas a las rurales, así como la penetración imperialista en el seno de la vanguardia condujeron a una difícil y grave situación para el futuro del pais, toda vez que el

